

GRIMM ANAYAK

# IPUÑAK

ALTUNA TAR JOSEBA'K EUZKERALDUTA




**GRIMM ANAYAK**

# Ipuñak

Altuna'tar Joseba'k euzkeralduta

Jauregibeitia'tar Ander'en indantzezkijak



Bilbao'n MCMXXIX Verdes-Atxirika'ren Irarkolan

# BIL̄ABIDIA

# IRAKUŔLIARI

---

Emen naukozu bañiro, irakuŕle euzkelduna.

Len Wilde'ren ipuin mamintsubakin etoŕi nintzakixun. Orain, ostera, Grimm anayen ipuin poliŕakin natoŕkixu.

Ipuin onek gustiz ezagunak dira eŕderaz. Ludi (mundu) gustiko umiak buruz ikasiŕa daukez. Geuk be umetaldijan ¡amaika bidaŕ irakuŕiŕa daukoguz eurok!

Baña orain janzki baŕijagaz jantziŕa datoŕkixuz: euzkel-jantzijagaz. Ele (berbeta) gustijakin apainduta mundu-ziaŕ dabiltzan ezkero, ¿zer dala-ta ez apaindu Euzkereagaz be?

Grimm'en ipuñak eztira umientzako bakaŕik Gixon egiñak be irakuŕi daikiez, astija gozaro emoteko baño ezpada be.

Jauregibeitia'taŕ Ander euzkeltzale zintzuak lagundu nau orain be, idazti onetarako idantzezki polit edeŕak egiŕen. ¡Jaunak ordainduko al-dautso, Euzkereari egiŕen dautson oparija!

EUZKERALTZAĻIA.

Bilbao'n, 1928'gko. Iraĺa-8'an, Ama Neskutzaren jayotz-egunian.



UNTZ zaŕak saspi antxume eukozan. Eta maŕe-maŕe ebazan, amak umiak maŕe dauzan lez.

Bein, bedaŕa jaten basora juan biaŕ ixan eban-eta, saspi antxumioi dei-egin eta esan eutsen:

—Ene umiak, oin basora nua, ¿bai?, ta otsuagaz kontuz ibili biaŕko dozube, etxera saŕtuten ba-yatzube, osorik iruntsiko zaŕube-ta. Otso malmutzok, iñor il gura daunetan, bere antza (bere itxurea) aldatu darua. Baña abots gaŕatzez ta anka baltzez ezagutuko dozube, noski.

Antxumiak amari erantzun eutsoen:

—Ama laztana, zuaz basora ezetariko bilduŕ barik, otsuagandik buruba zainduko dogu-ta.

Auntza, nasai-nasai, basora juan zan.

Gerotxubago atian jo eben, esanaz:

—¡Atia zabaldu, ene umiok! Ama emen daukozube. Guztijontzat gozuak-eta dakatzubedaz.

Baña abots gaŕatzez igaŕi eben antxumiok, otsua zala.

—Ez, eztautzugu idegiko—erantzun eutsoen—. Zeu etzara gure ama. Onek abots gozo-atsegingařija dauko, ¿bai?, ta zeuk, ostera, gařatza. Zu otsua zara.

Otsua, orduban, denda batera juan zan. Eta ařautzak erosi ta, abotsa leunduteko (bigunduteko), jan ebazan.

Antxumien etxera bařiro juanda, atia jo ta esan eutsen:

—¡Atia zabaldu, ume mařiak! Ama daukozube amen. Gustijontzako gozuak dakadaz.

Baña, igaři-barik, ate-ziřikiřutik anka bat sařtu eban. Eta berau baltza zala antxumiak ikusi ebenian, batera esan eutsoen:

—Eztautzugu zabalduko, ez. Amak eztauko olako anka baltzik. Zeu otsua zara. ¡Alde emetik!

Ori entzunda, otsuak okintza batera juan eta okiñari (ogigiñari) esan eutson:

—Anketan min ařtu dot, ¿bai?, ta oriagaz igořtzi biařko daustazuz.

Gero eřotara juan eta eřotarijari agindu eutson:

—Urunez ankak zuriřu egistazuz.

Eřotarijok, kolkorako esan eban: «Batobat atzipetu (engañau) gurako yok onek». Eta ezeutson urunik emon gura ixan. Baña abere ixukořak gure gixonari esan eutson:

—Orixe egiřen ezpa-daustazu, emen bertan iruntsiko zařut.

Eřotarijak orduban egin eutson, bilđuřez, otsuak eskatu eutsona.

Irugařenez antxumien etxeko atia jo ta esan eban otsuak:

—Zabaldu atia, enetxubok. Ama naz ta gustijontzako gozuak ekaŕten dautzubedaz.

Antxumiak erantzun eutsoen:

—Ankak erakutsi biaŕko dauskuzuz, ama zaran ala ez ikusteko.

Ate-zulotik erakutsi eutsezan.

Eta zurijak zirala ikusi ebenian, ama zalakuan, etxeko atia zabaldu eutsoen.

Baña etxera saŕtu zana, etzan ama ixan, otso ikaragaŕija baño.

Danok ikaratu ta eskutetan asi ziran.

Euretarik bat mai-azpijan eskutau zan. Beste bat, oian. Beste bat sutontzijan. Au eskaratzian. Ori arasan (armarijuan). Seigaŕena garbitokijan eta saspigaŕena gabeukatz (erloju)-baŕuban.

Baña otsuak banan-banan oratu ta aiko-maikotan ibiĺi-barik, banan-banan iruntsi euzan. Etxeko kutuna, gabeukatz-baŕuban eguana, ezin atrapau, baña.

Sabela ondo beteta gero, otsua etxetik alde-egin, zugatz (arbola) baten azpijan etzun eta luak aŕtu eban.

***

Gerotxubago, auntz zaŕa basotik atzera etoŕi zan.

Baña ¡a zan ikustekua! Etxeko atia zabalik eguan. Maya, arkijak eta zuzulubak luŕian sakabanatuta. Eskaratzeko azpiĺak (platerak)-eta, apuŕtuta. Burkuak eta ixarak oetatik atarata.

Ama eŕukaŕija umien biĺa asi zan.

Baña alpeŕik.

Batari ta bestiari dei-egin eta iñok erantzun ez.

Gastienari egin eutsonian, abots bigun batek erantzun eban:

—Amatxu, erloju-bafuban naukozu.

Bertatik atarata, antxumiok esan eutson amari, jazo (pasau) zan gustija.

¡Esan-biafik eztago amak egingo eban negafa!

Samiñez beterik, etxetik uften zan.

Antxumia atzetik juaten yakon.

Lafera elduta,otsua ikusi eben, zugatz baten azpijan, gerizpian, lo-zofuan eguana. Bere zufungakin zugatz -adafak dardarez eukozan.

Auntzak alde gustijetatik otsuari begiratu ta silbot andijan zirkiñik egiten eban zeozer igafi eban.

—¡Ene bada!—bafurako esan eban—¡Oraintxu iruntsi yonazan ene umiok bixirik egongo ete-dozan ondiño!

Antxume txikijari agindu eutson, etxera juan eta artazijak, jostofatza ta arija ekafteko. Gero otsuari silbota idegi eutson.

Artazikada bat baño ezeutson emon eta antxume batek buruba atara eban. Nafuba ebagi ta ebagi ta seirak uften ziran, bata bestien atzian.

Antxumiok ezeben miñik aftu, otsuak, gosiaren gosez, osorik iruntsifa eukozalako.

¡A zan poza! Danok batera ama laztandu gura eben.

Baña auntzak esan eutsen:

—Zuaze orain afi-bifa. Eurekin beteko dautsogu sabela, lo dagon bitaftian.

Antxumiak, ariñeketa baten, afi-kozkofak ekafi ta otsuari saftu eutsoezan. Gero auntzak silbota josi, otsuak ezer igafi-barik.

* * *

Itxaŕtu zanian, jagi ta oxiñera (pozura) juan zan ura edaten. Ibilten asi ta sabeleko aŕijak, alkaŕi jota, kosk -kosk egiten eben. Ori ikusita, otsuak burubari esan eutson:

—Zer aŕayo ete-yaukodak neuk sabelian? Antxumiak zuazalakuan, aŕijak dozak, itxuraz.

Oxiñera eldu ta ura edateko makuŕtu zan. Baña baŕuko aŕijen aztak (pisuak) laŕapast-eragin eutson, ¿bai?, ta jausi ta ito egin zan.

Saspi antxumiok, au ikusi ebenian, oxiñera eldu ta oyuka esaten eben:

—¡Otsua il da! ¡Il da otsua!

Eta jantza ta jantza egijen.



EGUBA zan. Eduŕ-malutak, jausten ziran ortzetiko(zerutiko) lumak ba'litzazl ez.

Bakaldun-emia (Eŕegiña) josten eguan leyo-onduan.

Eduŕari begira eguan-eta, igaŕi barik atzamaŕ baten jostoŕatza saŕtu eban.

Beriala eduŕ zuri-ganera iru odol-tanta jausi ziran.

Margo (kolore) goŕija eduŕ-aŕtian edeŕto ikusten zan-eta, Bakaldun-emiok, kolkorako, esan eban:

—¡Jaungoikua'k gurako al yon, gorputzez eduŕa baxen zurija, arpegiz odola baxen zuri-goŕija ta ulez leyo au baxen baltza ixango donan alabarik niri emotia!

Il̃abete batzuk igazit̃a (pasata), Jaungoikua'k emon eutson, gorputzez eduŕa baxen zurija, arpegiz odola baxen zuri-goŕija ta ulez *ebanua* baxen baltza zan neskatotxuba.

Orixe zala-ta, *Eduŕne Zuriñe* ixenak ipiñi eutsoezan.

Umia jayo ta ama il zan.



Urtebete-bařu, Bakalduna (Eřege), umiaren ała, bigařenez ezkondu zan.

Bakaldun-eme (Eřegin) bařija edeř-edeřa zan. Baña ařua ta okeřa. Beronentzat jasan (sufridu)-eziña zan, bera baño emakume edeřagorik begi-auřian ikusi biař ixatia.

Antzikuř liluratu (ispilu enkantau) bat eukan, ¿bai? ta oni iřanduten eutson:

—Ormatik dingilizka zagozan antzikuř mařia: ¿Nor ete-da gure bakaldeřiko (eřeñuko) emakumerik edeřena?

Eta antzikuřak erantzun eutson:

—Zeu zara, ene andria, bakaldeřiko emakumerik politena.

Eřegiña pozik eguan, antzikuřak egija esaten eutsolako.

Baña Eduřne Zuriñe azijago ta edeřago eguan. Saspi urte bete-orduko, eguzkija baxen polita ta Bakaldun-emia baño edeřagua zan.

Beste bein onek ispilubari iřandu eutson:

—Ormatik dingilizka zagozan antzikuř ořek, esan: ¿Nor ete-da gure eřiko emakumerik edeřena?

Eta antzikuřak erantzun eutson:

—Zeu, ene andria, edeřa zara edeřik ixatekotan. Baña Eduřne Zuriñe askozaz edeřagua da.

Bakaldun-emia, ori entzunda, asařatu ta atsekabetu zan. Eta bekatxa (enbirija) igaři eban bijotzian.

Ordutik auřera, Eduřne Zuriñe ikusten ebanetan, amuřez jařten zan.

Neskatilari gořoto andija ařtu eutson-eta, egunez ta gabez arterik ařtu-eziñik egoten zan.

Eiztari (kazadore) bati agindu eutson:

—Eruazu basora ume ori. Eztot begi-aurian ikusi gura. Baso-erdijan zagozenian il egixu. Eta ilda dagola ziñetsi dagidan, bere bijotza ekari biarko daustazu.

Eiztarijok Edurne Zuriñe artu ta basora eruan eban. Baña berau ilteko aiztua (kutxilua) atara ebanian, neskatilak, negarez, esan eutson:

—Zu, eiztari, itxi nagixu bixiten. Gura ba-dozu, basuan lotuko naz betiko ta enaz etxera beste bein elduko.

Eder-edera zan-eta, eiztarijak, erukiz beterik, erantzun eutson:

—¡Tira, ba... Zuaz ortik ziar!

Eta kolkorako esan eban: «¡Piztijak ilgo abe!»

Oratiño, baña, gure gixonari baruba nasatu yakon.

Andik laster orein bat agiri ixan zan. Eiztarijak bera il, bijotza atara ta Eregiñari eruan eutson, neskatilena zala esanaz.

Jauregiko eskatseñak gatzagaz egosi ta emakume ankerak jan eban, Edurne Zuriñe'ren bijotza zalakuan.



Gure neskatila baso-erdijan buruba bakarik ikusi ebanian, bildur-ikaraz asi zan. Zugatzetako adarai begiratuten eutsen, zer egin ezekijala.

Alako baten, sastraka ta arkaitz-artetik ariñeketan asi zan.

Basabere ta piztijak ondotik igaroten (pasetan) yakozan, baña kalterik egin-barik. Gustiz nekatu-arte geldiťu etzan.

Gaba elduta, etxetxu bat ikusi eban. Eta atsedenduteko (deskantsua artuteko) bertara sartu zan.

Etxetxu onetako gauza gustijak txiki-txikijak ziran, baña garbijak.

Mai txiki baten ganian zamau (mantel) zurija eguan. Eta beronen ganian saspi azpil (plater) txiki. Azpil bakotxaren onduan, zali (kolara), sarda, aizto ta edontzija egozan. Orma-onduan saspi oe txikar ikusten ziran, ixaratxubakin eta gusti. Ixaratxubok edura baxen zurijak ziran.

Edurne gose andija zan. Oregatik azpil bakotxetik pitin bat jan eta edontzijetatik ardao-tanta bat edan eban.

Gero, nekatuta egualako, oetxu baten etzun gura ixan eban. Baña ezin. Bata luziegija ba-zan, bestia laburegija.

Ibili ta ibili saspigaren oian etzun zan. Eta otoi -eginda gero, luak artu eban.

Gaberdijan etxekuak eldu ziran. Mendijan, miatoki baten lan-egiten eben saspi epo (enano) ziran.

Argija biztu ta laster igari eben iñor ibili zala etxian, gauzak ezegozalako eurok itxi ebezan lez.

Lenenguak itandu eban:

—¿Nor jezariko ete-zan nire arkijan (silan)?

Bigarenak esan eban:

—¿Nok jango ete-eban nire azpilian (plateran)?

Irugarenak:

—¿Ogi-zatirik nok kenduko eustan?

Laugarenak:

—¿Zeñek txastauko ete-eban nire zukuba?

Boskarenak esan eban:

—Nire sardeagaz batobat ibiľi da.

Seigaŕenak:

—¿Nok ebagiko ete-eban nire aiztuagaz?

Eta saspigaŕenak:

—Esango neuke iñok eđan daula nire edontziťik.

Orixe esanda, lenengo epuak aldera begiratu ta oia itxulastuta eukola ikusi ebanian, esan eban:

—¿Nire oian nor etzungo ete-zan?

Eta orduban danok batera esan eben:

—¡Baťa nirian be batobatek lorik egin dau!

Baña saspigaŕenak oera uŕeratu ta Eduŕne Zuriñe lo ikusi eban.

Ori ikusiťa anayai dei-egin eutsen. Eta saspi epuok ariñeketan juan eta saspi argontzijakin Eduŕne Zuriñe argiťu eben.

—¡Ene bada-ta!—danok batera esan eben—. ¡Auxe da neskatiľa edeŕa!

Gure mutil koskoŕok asko poztu ziran, eta ezeben zaratarik egin, Eduŕne ez itxaŕtuteko.

* * *

Bijaramon goxian Eduŕne Zuriñe itxaŕtu ta saspi epuok ikusiťa ikaratu zan. Baña onek, begikuak ziran eta, maťero iťandu eutsoen:

—¿Zelan dozu ixena?

—Eduŕne Zuriñe.

—¿Zer dala-ta gurera etoŕi zara?

Neskatiľak orduban esan eutsen jazo yakon gustija.

—Gura ba-dozu gurian lotu—epuak erantzun eu-

tsoen—etxia zaindu. soñekuak garbitu, josi ta jatekuak ipinteko, etxatzu ezer faltako.

—Bai ta pozik be.

Eta etxian geratu zan.

* * *

Edufne Zuriñe'k etxia zaindu ta basteŕetako autsak kenduten euzan sekulako edeŕtoen.

Saspi lagunak goxetik uŕten eta mendira zuzenduten ziran miak bilatuten. Gabian atzera etoŕten ziran, eta neskatilak ordurako gertu (prest) eukiten eban gustijontzako aparija.

Egunez, Edufne Zuriñe bakaŕ-bakaŕik geratuten zan beti. Oŕegatik epo zintzuak esaten eutsoen:

—Kontuz ibili biaŕko zenduban amordiagaz. Uŕian lasteŕ jakingo dau emen zagozala. Bada-ezpadan, ez itxi gure etxera iñori saŕtuten.

* * *

Bakaldun-emiak, bijotza janda gero, (Edufne Zuriñe'na zalakuan) ezeukon beste oldozkunik (pentsamenturik), bakaldeŕiko emakumerik edeŕena ixatia baño. Eta uste oŕegaz bein itandu eutson antzikuŕari:

—Ormatik dingilizka zagozan antzikuŕok esan: ¿Nor ete-da bakaldeŕiko emakumerik edeŕena?

—Edeŕ-edeŕa zara, ene andria—ispilubak erantzun eutson—baña saspi epuakin basuan bixi dan Edufne Zuriñe askozaz edeŕagua dozu.

Eŕegiña ixutu zan, antzikuŕak guzuŕik ezebala esaten ondo ekijalako. Eta lasteŕ igaŕi be eiztarijak atzi-

petu (engañau) egin eutsala, Edurne Zuriñe ondiño bixi zan-eta.

Gure andria oldozten jari zan, zelan atondu biarko eban neskatilea ilteko. Edozelan be ezeban gura besterik, bakalderiko (ereñuko) emakumerik ederena ixan baño.

Oldozketari (pentsamentubari) ekin eta ekin, auxe otu yakon: arpegija tximurez bete ta kalerik-kale ibilten diran atso saltzalien itxurea artu, iñok ezautu ezegijan.

Oretara jantzita, saspi epuok bixi ziran alderdirantz abijau zan.

Etxera eldu, atia jo ta esan eban:

—¡Neuk saltzen dodazan gauza on eta merkiak!

Edurne Zuriñe'k leyotik begiratu ta esan eutson:

—Egunon, andria. ¿Zertzuk saltzen dozuz?

—Gauza onak, gauza politak—atsuak erantzun eutson—. Gustitariko margodun (koloredun) lokijak (kordelak).

Eta sedazko zinta bat atara eban erakusteko.

—Atso erukari oni—Edurne'k kolkorako esan eban—sartzen itxiko yautsonat.

Eta atia zabaldu eutson.

—¡Ene alabea!—atsuak esan eutson—. ¡Zeuk daukozu itxurea! Gustiz txarto zagoz jantzita. Erdu ta gorantza estutuko dautzut.

Edurne Zuriñe'k eseban gauza txarik susmetan. Eta atsuaren aurian jarita, onek gorantza ezari eutson loki (kordel) barijagaz. Baña atsuok estutu ta estutu, gure neskatilea, arnasarik artu-eziñik, ilda lez jausi zan.

—¡Oi!—Bakaldun-emiak esan eban—. ¡Orain-arte

emakumerik edeřena ixan ba-zara be, etzara ixango emetik auřera beintzat!

Eta igesari emon eutson.

Geruago, gabez, saspi epuak etxera etoři ziran. Eta bilduř-ikarea sařtu yaken, luřian etzunda, ilda bai'litzan, Eduřne ikusi ebenian.

Jaso eben, eta gorantza estu-estu eukola ikusita, azkatu eutsoen.

Ařezkero, arnasea bařiro ařtu ta konortera etoři zan.

Jazo zanaren bari mutilok jakin ebenian, neskatilari esan eutsoen:

—Atso saltzale ori, Bakaldun-emia bera baño ezta ixan. Arduraz ibili, ba, ta etxian ezkagozanetan ez itxi iñori sařtuten.

***

Emakume ankeřak jauregira eldu ta antzikuřari itandu eutson.

—Zu, antzikuř: ¿Nor ete-da oin bakaldeřiko emakumerik edeřena?

Eta ispilubak, oi-eban legez, erantzun eban:

—Edeř-edeřa zara, ene andra ta eřegiña, baña saspi epuakin basuan dagon Eduřne Zuriñe zu baño askozaz edeřagua da.

Au entzunaz batera, odol gustija burura igon yakon. Asařatu zan gustiz, Eduřne Zuriñe ondiño bixi zala igaři ebanian.

—¡Orain, bai!—kolkorako esan eban—. Orain asmau biařko yonat zeozer, bein eta betiko ilteko!

Eta sorginkeriz ořazi bat egin eban, zitalez (benenoz) beterik. Gero beste atso baten antza ařtu, ořetarako

biař eban lez jantziła, ta epuen etxera eldu zan. Atia jo ta esan eban:

—¡Neuk salduten dodaz gauza onak eta merkiak!

Eduřne Zuriñe'k leyotik begiratu ta esan eutson:

—Zuaz beste leku batera, etxian sařtzen eztautsot iñori itxi biař-ta.

—Sařtuten isten ezpa-nozu be, nire gauzak ikusi gurako dozuz, ¿ezta?—atsuak esan eutson, ořazi ziłala erakutsijaz.

Neskatiłari ořazijoi atsegin ixan yakon. Eta beste barik atia zabaldu eban.

Zenbat kenduko eutson iłundu ebenian, atsuak esan eutson:

—Orain ondo ořaztu biařko dautzut ulia.

Eduřne Zuriñe'k ezeban gauza okeřik susmetan-eta, bayetz erantzun eban. Baña zoritxařeko ořazijoi buruban ezaři ta neskatiłea luřera jausi zan, luze-luze.

—¡Neskatiłarik edeřena!—emakume gaiztuak esan eban—¡Orain ezaz gaizkatuko (salbauko), ez!

Eta alde-egin eban.

Zorijonez, au iłuntzijan jazo zan, eta etxeko mutiłak lasteř eldu ziran.

Luřian etzunda, ilda ba'lego lez, Eduřne ikusi ebenian, amordiaren gauzea ixango zala susmau eben. Eta neskatiłari ondo begiratuta, ziłalez ukututa eguan ořazija ikusi eutsoen.

Bera kendu ta konortera etořten asi zan.

Gero epuoi esan eutsen, jazo yakon gustija. Oneik beřesan eutsoen atia iñori ez zabalduteko.



Bakaldun-emia jauregira eldu ta antzikuŕari iŕanduten asi yakon:

—Antzikuŕ maŕia, esan: ¿Bakaldeŕiko emakumerik edeŕena nor ete-da orain?

Eta ispiłubak erantzun eutson, oi-eban letxe:

—Edeŕ-edeŕa zara, ene andria, baña saspi epuakin basuan bixi dan Eduŕne Zuriñe edeŕagua da, askozaz be.

Au entzunda, gure emakumia, amuŕuz bete zan.

—¡Eduŕne Zuriñe il biaŕko da—burubari esan eutson—neuk be bixitxa galdu biaŕko ba'neu be!

Orixe esanda, jauregiko bazteŕ baten eguan txaki (gela) batera saŕtu ta ziŕalez beteriko sagaŕa gertau (prestau) eban.

Sagaŕ au zuri-goŕija zan eta margoz (kolorez) ta itxuraz beintzat jangaŕija. Baña zati bat baño etzan jan biaŕ, bat-batez ilteko.

Zeregin au amaŕuta, aŕpegija margoztu (pintau) eban, iñok ezautu ezegijan.

Asko ibiłita gero, epuen etxera eldu zan. Etxera eldu ta atia jo eban.

Eduŕne Zuriñe'k, leyotik buruba atarata, esan eutson:

—Ezin dautsot iñori etxian saŕtuten itxi: saspi epuok galerazo dauste, ta gogoŕ galerazo be.

—Ezta ardura ori—saltzałiak erantzun eutson—. Eutsi sagaŕ au. Neuk ekaŕi dautzut jan dagixun.

—Ez—Eduŕne'k erantzun eban—. Ezin dot aŕtu ezer be.

—¿Ziŕalez beterik dagonik uste dozu, ala? ¡Tira, ba! Oŕezkero erdibiŕuko dot, ¿bai?, ta zeuk goŕija ta nik

zurija jango dot. (Esan-biaŕik eztago, sagaŕak ezeukola ziŧalik alde goŕijan baño).

Eduŕne Zuriñe'k, atsuak be jaten ebala ikusiŧa, jan gura ixan eban. Eta leyotik eskuba luzatuta, ziŧalik eguan sagaŕ-erdija aŕtu eban. Baña abora saŕtu ta luŕera, ilđa, jausi zan.

Bakaldun-emiak begirada itxala jaurti ta baŕeka esan eutson:

—¡Eduŕa baxen zurija, ođola baxen goŕija ta ebanua baxen baltza zaran ori: orain etzaitube epuak iratzaŕtuko!

Eta jauregira elduta, antzikuŕari iŧandu eutson:

—Ormatik dingiŀizka zagozan ispiŀu oŕek, esaistazu: ¿Bakaldeŕiko emakumerik edeŕena nor ete-da orain?

Antzikuŕak erantzun eutson:

—¡Zeu zara, ene andria, emakumerik edeŕena!

Ori entzunaz, bijotz ankeŕa nasaŧu zan, olako bijotzik nasaŧu al ba-đai.

* * *

Epuak gabian etoŕi ta Eduŕne luŕian etzunda auŕkiŧu eben.

Baña onek arnasarik ezeukon. Ilđa eguan, edo itxura oŕetan beintzat.

Luŕetik jaso, alde gustijetatik begiratu, baña ezeutsoen ezer ikusten.

Ulia oŕaztu ta ura ta arđauaz garbiŧu eben. Baña alpeŕik: neskatiŀa gaxua ilđa auŕkitzen zan.

Zeŕalduan saŕtu ta iru egunetan gure epuok negaŕari emon eutsoen.

Orduban otu yaken luraldutia. Baña arpegija otza ta matralak zuri-gori eukozan-eta, alkari esan eutsoen: «Tamala da neskatila au lur-azpijan sartutia».

Gerotxubago erabagi eben, leyarezko (kristalezko) zeraldua egin, alde gustijetatik ikusi al ixateko.

Edurne Zuriñe bertan sartu ta bere ixenak urezko izkijakin (letrakin) ipiñi eben, bakaldun (erege) baten alabea zala esanaz. Gero mendi-tontorian zeraldua ipiñi eben. Egunez ta gabez epo bat egoten yakon zaindari.

Aberiak be Edurne Zuriñe'gana juaten ziran, negarez.

Lenengo, ontza bat juan zan. Onen ondoren, belea, ta, azkenez, usotxu bat.

Edurne Zuriñe luzaro egon zan zeralduan, usteldu -barik. Edonok esango eban lo eguala, gorputza edura baxen zurija, arpegija odola baxen zuri-gorija ta ulia baltz-baltza eukolako.

Alako baten, bakaldungai (printzipe) bat basora eldu zan eta saspi epuakin gaba pasetan lotu zan. Mendijan ikusira eukon zeraldua, ta zeraldo-baruban Edurne Zuriñe. Urezko izkijakin idatzira eguana irakurira, epuoi esan eutsen:

—Zeraldo au emoten ba-daustazube, gura dozubena emongo dautzubet.

Baña epuak erantzun eutsoen:

—Ludi (mundu) gustiko urien ordez (truke) be ezkeunke zeraldo ori salduko.

—Orezkero, dubarik emon biarko daustazube, Edurne Zuriñe ikusi-barik ezingo dot bixi-ta. Bezuzarik (eregalorik) ederena lez artuko neuskixube.

Ori entzunda, epuak eřukiťu ta zeřaldua emon eutsoen.

Bakaldungayak mořoyai agindu eutsen lepuan ařtu ta eruateko. Baña oneik ibilten asi zirala, sasi baten kontra jo eben, ¿bai?, ta onen zartadeaz Edufne Zuriñe'k jaurti eban estařijan eukon sagař-zatija. Ziťala abotik bota ta berialaxe begijak zabaldu, zeřaldo-atia zabaldu ta zutindu zan; ařezkero berbiztuta eguan.

—¡Ene bada!—neskatiľak esan eban—. ¿Nun ete -nago?

Bakaldungayak, pozez beterik, erantzun eutson:

—Nire onduan zagoz.

Jazo zanaren baři emonda gero, esan eutson:

—Nik mate zaitut. Aťaren etxera erdu ta nire emaztia ixango zara.

Edufne Zuriñe'k be Bakaldungaya maťe ixan eban. Eta bijok ezkondu ziran, eztegu ospetsubak egiñaz.

Jai onetara dei-egin eutsoen Edufne Zuriñe'ren amorde okeřari.

Onek, jantziťa gero, antzikuř-auřian jaři ta iťandu eutson:

—¿Nor ete-da bakaldeři onetako emakumerik edeřena?

Eta antzikuřak erantzun eban:

—Ene andria, zeu edeřena zara bakaldeři onetan, baña oraintxu ezkondu dan bakaldungai-emia (Printzesa) zeu baño edeřagua da.

Eřegiñak, ori entzunaz batera, birao-egin eban. Eta amuřubaren amuřuz, zer egin ezekijan.

Lenengo otu yakon eztegubetara ez juan. Baña gero juatia erabagi eban.

Jauregiko aretora (saloira) sartu zanian, Edurne Zuriñe ikusi ta ezautu eban. Eta, ikaraz ta bildurez, dardarez eguan.

Arezkero, sutan egozan burdiñezko oskijak (zapatak), oñetan gori-gori jantzi biarko ebazanak.

Gura-ta-ez jantzi ebazan oskijok. Eta eurekin jantza egin biar ixan eban, lurera, ilda, jausi-arte.





Neskato poliŕa zan.

Neskato au danak maŕe ixaten eben, baña batez-bere amamak. Onek ezekijan maŕasuna zelan erakutsi.

Bein tertziopelo goŕiz egindako txanotxuba emon eutson.

Beronegaz jantziŕa edeŕto egoten zan-eta, ezeban gura ixaten beste gauzarik buruban ezaŕi. Orixe dala -ta, *Txanotxu goŕija* danok ereisten eutsoen.

Amak esan eutson bein:

—Erdu ona, Txanotxu. Opil eta ardao-bonbil (botiŕa) onek aŕtu ta amamari eruan egijozuz, gexo ta makal -samaŕ dagolako. Beragaz zintzua ixan, ¿bai?. ta ezegijozu apuŕtu etxeko tresnarik. Eta ez aiztu *egunon* esaten. Kontuz ibiŕi biaŕko dozu, ta bidian ez geratu astirik galduten, bestelan jausi ta bonbiŕak apuŕtuko zeunkez-ta. Oŕezkero ezer barik lotuko litzake amama gaxua.

Txanotxu'k erantzun eutson amari:

—Agindduten daustazun gustija ziatz-ziatz beteko dot. Ez ardurarik ixan.

* * *

Amama basuan bixi zan, eřiřik ordu-erdiko bidian. Txanotxu'k basora eldu ta otso bat auřkiřu (topau) eban. Txanotxu'k ezekijan pizti au dan okeřa. Eta bilduřtu etzan.

—Egunon, Txanotxu—otsuak esan eutson.

—Bařa zeuri be, otso.

—Goxetik zabiltz.

—Bai, amamagana nua.

—¿Zer ete-daruazu altzoyal (amantal)-bařuban?

—Opiřak eta ardaua, amamak ařtu dagijazan, egunokaz gexo-samař dago-ta.

—Zu, Txanotxu, ¿amama nun bixi da?

—Baso-erdira sařtuta, arte-azpiko etxetxu baten, intxauřonduak dagozan tokijan. ¡Ezautuko zendubala uste neban!

Otsuak, biřařtian, burubari esaten eutson: «Neskato au samuř ta gozua ixango dok jateko, amama baño samuř-gozuagua, noski. Neu konponduko nok bijař atrapetako».

Txanotxu'ri, pizkat lagunduta gero, esan eutson:

—Zu, Txanotxu: ¡Begiřu inguruban daukozuzan lora edeřok! ¿Zer dala-ta eztautsezu begiratuten? ¿Zer dala-ta eztautsezu txori abeslarijai adiřuten? ¡Basuan dana dago alai-pozkoř! Zeu, bařiz, iřun (triste) zagoz, ikastolara zuzenduten diran umiak lez.

Txanotxu'k albora begiratu eban. Eta eguzki-izpijak zugatzetako adař-ařtetik sařtzen eta luřa loraz beterik eguala ikusiřa, kolkuari esan eutson:

—Lora-txortarik eruango ba'nayeutsonat, amama poztuko zonan. Ondiño goiz don-eta. astija yaukonat lorok ařtuteko.

Eta beste barik lorak batuten asi zan.

Bat afitzen ebanian, auxe otuten yakon: «aruntzago juan ezkero, lora poliñaguak egongo dozan».

Eta geruago oyan-bañurago sañuten zan.

***

Biñartian, otsuak amamaren etxera eldu ta atia jo eban.

—¿Nor da?

—Txanotxu naz, ta zeugana natoř opil eta ardauagaz. ¡Zabaldu atia!

—Kisketari sakatu egijozu. Makal-samař nabil, ¿bai?, ta ezin jagi nengike.

Otsuak anbařari (kisketari) sakatu, bařura sařtu ta, ezer esan barik, amama iruntsi eban. Gero bere soñeko ta txanua jantzi ta oera sařtu zan.

***

Au jazoten zanian, Txanotxu lorak batu ta batu ebiřen. Txorta andija euki ebanian, amamagaz gomutau ta onen etxerantz abijau zan. Atia zabalik ikusiřa, geldu (mirariřu) zan.

Bařura sařtuta, bakana eritxi eutson etxiari. Eta bururako esan eban:

—¡Ene! Gauř bilduř non. Beste egunetan, bařiz, amamagaz egoten atsegin ixaten yatan.

Eta amamaren ogokira (oe-tokira) sařtuta, esan eban:

—¡Egunon, amamatxu!

Baña iñok erantzun ez.

Orduban oera uŕeratu ta kortiñak zabaldu euzan, argija saŕtuteko.

Amama oian eguan, txanuagaz aŕpegija estalduta eukolarik, itxura baŕegaŕijan.

—Baña amamatxu, ¡zeuk daukozuz belaŕi luziak!

—Obeto entzuteko zeuri.

—Baña amamatxu, ¡zeuk daukozuz begi andijak!

—Zeu obeto ikusteko.

—Baña amamatxu, zeuk daukozuz esku zabalak!

—Obeto eutsiŕeko zeuri.

—Baña amamatxu, ¡zeuk daukozu abo sakona!

—Zeu obeto iruntsiŕeko.

Au esanaz, oetik jauzi (saltu)-egin eta otsuak Txanotxu iruntsi eban.

Abere ixugaŕija, gosia kenduta geroxe, oera saŕtu ta luak aŕtu eban. Gerotxubago zuŕuka eguan. ¡Baña a zan zuŕu-egiŕia!

* * *

Alako baten, eiztari (kazadore) bat igaro zan andik. Eta zuŕungak entzunda, baŕurako esan eban:

—¿Zelan aŕayo konponduko ete-dok atso ori, olako zuŕu itxalak egiŕeko? Baŕura saŕtu biaŕko nayuan, ia zer yaukuan ikusten.

Orixe eginda, oera eldu ta otsua ikusi eban.

—¡Tirok, ba, otso malmutza! ¡Ibiĺi ta ibiĺi idoro (topau) aut!—eiztarijak esan eban—. ¡Aspaldiŕik nayenbiĺan ire atzetik!

Eskopetiagaz il gura ixan eban.

Baña gogoratu ebanian, otsuak, biafba, etxeko atsua iruntsiña eukiko ebala, ezeutson tirorik jaurti. Ori egin-biafian, beste gauza bat egin eban: artazijak afłu, ¿bai?, ta ondiño lo-zofuan eguan piztijari sabela ebagi eutson. Artazikada batzuk eginđa gero, neskatuak ufłen eta esan eban:

—¡Ene, bada! Niria ixan da bilđufa! Otsuaren sabelian ilun-ilun eguan-eta!...

Gerotxubago, arnasa-oska, amama ufłen zan.

Txanotxu'k afijak ekafi ta otsuaren sabelera safłu ebazan.

Onek itxafłu ta jagi gura ixan eban. Baña ezin. Afijak aztunak ziran-eta, lufera jausi ta il zan.

Iru notiñak (personak) asko poztu ziran.

Eiztarijak otsuaren nafuba afłu eban. Amamak jan-edan eban Txanotxu'k eruan eutsona. Eta gure neskatuak kolkuari esan eutson:

—Amak galerazoten yaustanik etxonat beste bein egingo.

* * *

Esaten dabenez, amamari bederatzi opil eruaten eutsozan beste egun baten, Txanotxu'k beste otso bat aufkiñu eban bidian. Baña otsuok neskatuari bidia galdu-eragin gura ixan be.

Baña Txanotxu'k, zuzen-zuzen, amamaren etxera eldu ta edestu (esan) eutson, bidian otso bat aufkiñu ebala, ta «egunon» esan eutsonian, aberiak begirada itxala bota eutsola. Kale-erdijan egon-ezik, berialako baten iruntsiko eban afanuok.

—Etxeko atiak itxi daiguzan, ona sartu eztadin—amamak esan eutson.

Gerotxubago, otsuak atia jo eban, esanaz:

—¡Zabaldu atia, amama! ¡Txanotxu naz ta opil gozuak dakatzudaz!

Baña amama ta umia ixildu ziran. Eta ezeutsoen jaramonik egin.

Ori ikusita, otsua egastira (telatura) igon eta antxe lotu zan itxaroten, Txanotxu noiz etxetik urtengo, iluntzijan-edo irunsteko asmoz. Baña amamak igari eban otsuaren ustia.

Etxe-aurian suil andija ta sakona euken, ¿bai?, ta atsuak neskatuari esan eutson:

—Sulera bota egixu, okelea egosteko atzo erabili geban ura.

Txanotxu'k ur asko bota eban, sula bete-arte.

Okela-usaña otsuak susmau ebanian, usañoi nundik ete-etoran ikusteko, samea luzatu biar ixan eban-eta, larapast-egin, telatutik sulera, artez-artez, jausi ta ¡erukarija!, ito zan.

Txanotxu etxera biguŕtu zan pozik, ezeren bildur barik.



GIXON batek, *Jone zuŕa* eritxoen alaba bat eukon.

Aziŕa egon zanian, aŧak esan eban:

—Alabea ezkondu biaŕko dogu.

—Bai—emaztiak erantzun eutson—. ¡Bere duña ixango dan senaŕik topauko al-dau!

Egunak juan egunak etoŕi, *Jontxu* eritxon mutiŧak emaztetzat eskatu eban. Baña baldintza edo kondiziño onegaz: poliŧa baxen zuŕa (buru argija) zala Jone'k erakutsi biaŕko eban.

—¡Ene!—aŧak esan eutson—. ¡Tentelen itxurarik eztauko, zuŕ-zuŕa da-ta!

Eta amak esan eban:

—Gure Jone'k axia zelan dabiŧan *ikusten dau*, ta eulijak estulik egiŕen ba-dabe be, *entzuten dautse*. ¡Eta zelan ikusi ta entzun gero!

—Zentzun andikua ezpa-da, enaz beragaz ezkonduko—Jontxu'k gurasuai esan eutsen.

Bazkal-ostian, mai-inguruban jezaŕiŧa egozala, amak neskatiŧari esan eutson:

—Zu, Jone, upategira jatsi zaŕez ta garagardaua (zerbezia) ekaŕi egiskuzu.

Jone, pitxaŕa aŕtu ta upategira jatsi zan.

Pitxaŕa upa-onduan betetan ipiñiŕa gero, begijak jaso ebazan, ormari begira.

Alde gustijetara begiratuta, ormatik dingiŕizka eguan aizkorea ikusi eban.

Jone'k, orduban, negaŕari emon eutson, burubari esanaz:

—Jontxu'gaz ezkonduta gero, umerik ba'geunko, ta umioi aziŕa gero upategi onetara bidalduko ba'gendu, uŕian aizkorea buru-ganera jausiko litzakijo, ume gaxua iŕaz.

Eta negaŕ ta negaŕ egiŕen eban.

* * *

Goyan edarijaren begira egozan gustijok. Baña Jone'rik agertu ez.

Orduban andriak neskamiari esan eutson:

—Upategira jatsi zadiz, Jone guriak zer egiŕen daun ikusten.

Neskamiak, upategira elduta, Jone negaŕez auŕkiŕu eban.

—¿Zer dala-ta negaŕik egiŕen dozu?—iŕandu eutson.

—¡Oi, ene! ¿Negaŕik egingo eztot, ba? Kontuxu Jontxu'gaz ezkonduko ba'nintz ta umerik ba'geunko, upategi onetara, uŕian, bidalduko geunkela, ¿ezta? Eta oŕ dagon aizkorea burura jausi-ezkero, ume gaxuak il biaŕko eban.

Orixe entzunda, neskamiak esan eban:

—¡Gure Jone da neskatila zuřa, neska zuřik ixatekotan!

Eta beste barik, onen onduan jaři ta negařari emon eutson.

*
* *

Goyan egozanak egaři ziran. Eta itxaroten luzaro egonda gero, mořoyari esan eutsoen:

—Upategira jatsi biařko dozu, Jone ta neskamiak zer ařayo egiřen daben ikusten.

Mořoyak upategira jatsi ta neska bijok negař baten ikusi euzan.

—¿Zer dala-ta negař ori?

—¡Oi, ene!—Jone'k erantzun eutson—. ¡Negařik egingo eztogu, ba! Jontxu'gaz ezkondu ta umerik eukiřa ona bidalduko ba'geu, aizkoreak ganera jausi ta ilgo leukian.

Orixe entzunaz, mořoyak esan eban:

—¡Jone guria da neska zuřa!

Eta beste barik, onen onduan jezaři ta gařazika asi zan.

*
* *

Goyan, begira egozan gustijok. Eta iñor agertuten etzalako, gixonak emaztiari esan eutson:

—Upategira jatsi ta ikusi egixu Jone ta lagunak zer demontre egiřen daben.

Emaztiak upategira jatsi ta iru kankalubok negařez ikusi euzan. Zer zala-ta negař-egiřen ete-eben iřandu eutsenian, Jone'k esan eutson bestioi esan eutsena.

Ori entzunda, amak esan eban:

—¡Ene! ¡Gure Jone da neska zuŕa!

Eta negaŕtijen onduan jaŕiŕa, negaŕari ekin eutson.

*
* *

Senaŕa begira eguan. Baña itxaron eta itxaron, aspeŕtuta, esan eban:

—¡Neronek jatsi biaŕko dot, Jone ta lagunak zetan dagozan ikusten!

Upategira jatsiŕa, danok negaŕez ikusi ebazan.

Negaŕen zegaŕija jakin ebanian, esan eban:

—¡Geuk daukogu alaba zuŕa!

Eta luŕian etzunda, aŕausika asi zan.

*
* *

Senaŕgaya bakaŕ-bakaŕik lotu zan goyan. Baña iñor agertuten etzan-eta, kolkuari esan eutson:

—Nire begira egongo dozak beyan. Zer baŕabas egiŕen yuen ikusten juan biaŕko yuat, aŕayetan!

Upategira saŕtu ta gustijok ai-eneka ta oyuka ikusi ebazanian, iŕandu eutsen:

—¿Ezpiaŕik jazo da, ala?

—¡Oi, ene Jontxu maŕia!—Jone'k esan eutson—. ¡Alkaŕekin ezkonduta gero, umerik ba'geunko ta garagardao-biŕa ona bidalduko ba'gendu, aizkora ori ganera jausiko litzakijo, gaxua erdibiŕubaz. ¡Negaŕik egingo eztogu, ba!

Ori entzunda, Jontxu'k esan eutson:

—Gure etxia erabilteko eztot biaŕ besterik. Zuŕ-zuŕa zara-ta, ene Jone, zeugaz ezkonduko naz.

Eta eskutik elduta, alkaŕegaz gora igon ziran.

Gerotxubago ezkontzea egin eben.

*
* *

Egunak juan egunak etoŕi, Jontxu'k emaztiari esan eutson:

—Txinđirik (dirurik) irabazten atara (kanpora) juan biaŕko dot. Zuaz zeu solora, garija ebagiten, ogija egin dagigun.

—Bai ta pozik juan be—Jone'k erantzun eban.

Senaŕak etxetik alde-eginda, janari gozua gertau (prestau) ta solora eruan eban gure andreak.

Bertara elduta, burubari iŕandu eutson:

—¿Zer egingo ete-yonat? ¿Biaŕ-egin ala jan? Lenengo, jan egingo yonat.

Esan eta egin. Asetu zanian, kolkuari esan eutson:

—¿Zer egingo ete-nayeuken? ¿Garija ebagi ala lo? Lenengo, lo-egingo yonat.

Gari-aŕtian etzun eta luak aŕtu eban.



Senaŕa aspalditik eguan etxian.

Baña Jone agiri ez.

Orduban gure gixonak kolkorako esan eban:

—¡Gure Jone dok andra zuŕa! Gustiz langilia dok -eta, jaten be eztok etxera etoŕten.

Gaba zan-eta, Jontxu bere bila uŕten zan.

Baña solora elduta, garija ebagi-barik eta emaztia luŕian etzunda, lo-zoŕuan, ikusi ebazan.

Orduban Jontxu'k etxera juan, txilin bat aŕtu ta Jone'ri samatik eskegi eutson. Ori eginda, etxera biguŕtu, atia itxi ta arki (sila) baten jezaŕi zan.



Gaberdijan Jone itxaŕtu zan. Eta ibilten asi zalarik, txiliñak jo ta jo egiten eban.

Ikaratu zan gustiz. Ezekijan *Jone zuŕa* ala nor ete-zan.

—¿Jone ete-non? ¿Ala ez?—burubari egiten eutson.

Burubak zer erantzun ezekijan-eta, neskatilak esan eban:

– Etxera juan biaŕko yonat, Jone ala nor nonan jakiŕeko. An jakingo yone.

Ariñeketa baten etxera juan zan.

Baña atia itxiŕa eguan.

Orduban, kanpotik dei-egin eta itandu eban:

—Zu, Jontxu: Jone ete-dago oŕ, baŕuban?

—Bai—Jon'ak erantzun eutson—. Ementxe dago Jone guria.

Andriak, gustiz ikaratuta, burubari egin eutson:

—¡Nire eŕukaŕija! ¡Nor nonan be etxakiñat!

Eta beste etxe batera juan eta atia jo eban.

Baña eŕitaŕak, txiliñaren otsa entzunaz, ezeutsoen aterik zabaldu gura Eta onetara, kale-erdijan lotu biaŕ ixan eban.

Alako baten eŕitik alde-egin eban.

Eta eztau iñok beste bein ikusi.





GUŔGIN zintzua, emazte ta iru alabagaz, oyaneko txabola baten bixi zan.

Goiz baten, lanera juan baño lentxubago, emaztiari esan eutson:

—Gauŕ zugatz tantai bat luŕera eratsi biaŕko dot, ¿bai?, ta, astirik ez galduteko, enaz bazkaltzera etoŕiko. Bazkarija alaba nagusijagaz bidaldu egistazu. Bidia galdu eztagijan, galburu batzuk eruango dodaz ta gari-aliak botako dodaz etxetik zugatzeraño. Oŕetara, bidia topauko dau.

Goxeko amaiketan Koldobike neskatiļea zukuz beteriko lapikua ta ogi-zatija aŕtu ta aŧaganantz zuzendu zan.

Bidia asita, gari-ale batzuk ikusi ebazan oŕ emen sakabanatuta. Baña gero ezeban besterik ikusi, ale onekin txorijak betekada galanta egin ebelako

Oŕaŧiño, neskatiļeak auŕera egin eban.

Baña gustiz galdu zan. Atzera egin gura, ta baŕurago saŕtu.

Pizkat atsedendu (deskantsua aŕtu) ta aŧarentzako

eroyan zukuba jan eban. Gero bidiari ekin eutson oyan (baso)-ziaŕ.

***

Eguzkija mendi-ostez eskutau zan.

Koldobike bilduŕez eguan, mozoluen gaŕazijak eta, axiak bultz-eraginda, zugatzetako adaŕak egiten eben otsa entzunaz. Berau, baña, auŕera joyan, astiro ta ikar-az ba-zan be.

Ibili ta ibili, nun saŕtu idoroko (topauko) ebanik uste ezebanian, zugatz-aŕtetik argija ikusi eban.

Onegaz adoretu zan.

Eta ariñago ibilita, leyuak argituta eukozan etxetxu batera eldu zan.

Atia jo eban. Eta baŕuko abots gogoŕak esan eutson:

—¡Saŕtu baŕura!

Koldobike'k atia zabaldu ta auŕez-auŕ ikusi eban, mai-onduan jezaŕita eguan eta luŕerañoko bixaŕa eukon agure bat. Bazteŕian olaŕ bat, olo bat eta txala bat egozan.

Koldobike'k edestu eutson gixonari, jazo (pasau) yakon gustija, bała eskatu be etxian saŕtzen isteko, gaba igaroten (pasetan).

—Olaŕ edeŕa, olo polita ta txal maitoi: ¿zer eristen dautsozube neska onek eskatuten daunari?

Aberiak, bakotxak bere elez (berbetaz), bayetz-edo erantzun eben.

Agureak, orduban, Koldobike'ri esan eutson:

—Lotu (geratu) zadiz emen. Bazteŕ atako atia zabaldu: oŕ eskatza dago ta bertan auŕkituko dozu apari ona gertetako biaŕko dozun gustija.

Egin-egiñian be, Koldobike'k aurkitu ebazan gustitariko gauzak.

Suba egin eta aparija gertau eban.

Gero mayan ezari euzan janari-edarijak. Eta aguereagaz apaldu eban.

Baña berak apalduta gero, aberiak be apaldu biarko ebenik gogoratu ez. Sabela bete-bete ebala, oia nun ete-eguan irandu eban, atseden (deskantsu)-biara eukola-ta.

Aberiak, mor-mor, kolkorako esaten eben:

—Neskatila ganorabako onek jan eta edan yok sekulako edertoen. Baña geugaz gomutau ez. Guri bardin yakuk, ba, emen edo basuan beronek lotu biar ixatia.

—Zurubitik (eskileratik) gora igon, ¿bai?,—agureak esan eutson—ta ogoki (lo-gela) bi aurkituko dozuz. Ogoki bakotxian oe bat. Euretarik bata zuretzat, eta bestia niretzat ixango da. Ixearak-eta, biar diran lez ipiñi.

Koldobike'k igon eta oe bat baño ezeban atondu (egin). Bertan etzun eta luak artu eban.

Gerotxubago, argi bategaz, agurea igon zan.

Eta oe bat baño atonduta ezeguala ikusi ebanian, sorginkeri bat egin eta Koldobike'ren oia etxeko zulo sakon batera jatsi zan. Beriala gora igon zan bariro, baña utzik.

* * *

Bitartian, egurgiña, asare bixiz etxera bigurtu zan, emaztiak bazkaririk ezeutsola bidaldu uste ixanaz.

Onek bayetz esan eutsonian, egurgiñak susmau be

ezeban egin alabeari ezpiaŕik jazoko yakonik, basuan ez otsorik, ez artzik, ez olako abere ixugaŕirik ezegualako. Bere ustez, edozein gixonek erakutsiko eutson neskeari etxerako bidia.

—¡Bakana dok, oŕatiño, gari-alerik luŕian ez ikustia!—burubari egiten eutson—. Gauŕ tilistak (lentejak) eruan biaŕko yuadaz, aundijak ixanda obeto ikusten duazalako, bijaŕ be bertora, lanian, jo biaŕko yuat-eta.

* * *

Bijaramonian, eguŕgiña biaŕera juan zan.

Goxeko amaikak jota, emaztiak bazkarija bidaldu eutson Marte ixena eukon bigaŕen alabeagaz.

Bidiari ekiten asita, oŕ ta emen sakabanatuta, tilista batzuk ikusi euzan neskatileak. Baña beste tilistak txorijak janda eukezan-eta, bidia lasteŕ galdu biar ixan eban.

Baso-erdijan galduta, Koldobike'k lez, iru aberiakin bixi zan agurearen etxetxuba ikusi eban.

Bertan saŕtuta, atzeko egunian aizteari jazo yakon gustija beroni be jazo yakon. Orixe zala-ta, etxeko zulo sakonian auŕkitu eban Koldobike aiztea, lasto-ganian etzunda, negaŕ ta negaŕ eguana.

* * *

Eguŕgiñak etxera etoŕi ta jazo zanaren baŕi jakin ebanian, emaztiari esan eutson:

—Ez estutu oŕegatik. Nik uste dot umiak lasteŕ

etoŕiko dirala atzera. Gure Susanetxu'k, esanekua ta zuŕa da-ta, eztau bijaŕ biderik galduko.

Baña eguŕgiñaren emaztiak, negaŕari emon eta erantzun eutson:

—¿Eta azaŕtuko ete-giñian ondiño, irugaŕen alebea galduteko zorijan ipinten?

—¿Nok esan ete-dau galduko zanik? Kontuban euki buru argidun umia dala, ta, oŕez ganera, bidian indabak botako dodazala, txorijak jan eztagijezan. Oŕezkero, ezta galduko.

* * *

Esan eta egin.

Txorijak ezin indabarik jan, andijak ziralako, baña mirubak, belak-eta etoŕi ta banan-banan indaba gustijak jan ebezan.

Gure Susane, ba, aizta bijak lez, galdu zan oyanian.

Batetik bestera ibiliŕa gero, agurearen etxera jo eban.

Onek, aberien baimenagaz, oi-eban letxe, etxian saŕtuten itxi eutson.

Susane'k aberiakana uŕeratu ta olaŕa ta olua laztandu ta txalari adaŕetan atz-eragin eutson.

Aparija gertauta, mayan jezaŕi baño len, olaŕa, olua ta txalari jatekua ipiñi eutsen. Ori eginda, patiñetik ura atara ta iru aberioi edateko ipiñi eutsen, baŕa onek gogoz ta pozez edan be.

Zeregin gustijak amaŕuta, apalduten asi zan.

Oera juateko orduba elduta, aberiak esan eutsoen:

—¡Gau ona eukiko al-dozu, gustiz ondo zaindu gozuz-ta!

Susane gora igon, agurearen eta bere oiak atondu

ta lotarako gertau zan. Baña luak ar̃tu baño lenago Jaungoikua'ri eskatu eutson, berak eta beste aizta bijak etxerako bidia topau egijen. Otoi ori eginda, lo gozuak ar̃tu eban.

* * *

Gaberdijan zarata andija ixan zan.

Etxeko er̃edixak eta ormak kir̃izka-egin eta atiak zabaldu ziran.

Susane, ikaraz, itxar̃tu zan.

Baña etxia ixil̃ik eta artetsu (baketsu) geratu zan -eta, luak bar̃iro ar̃tu eban.

* * *

Ur̃engo goxian, itxar̃tu zanian, ur̃ezko oe baten buruba ikusi eban. Oraingo txakija (gelea) lengua baño askozaz andijagua zan. Ormak eun polit-ikuskar̃ijakin apainduta egozan. Er̃edixak ur̃ezkuak ziran. Oe-onduan bitxiz apaindutako janzki bi aur̃kitzen ziran.

Susane'k uste eban amesetan eguala.

Bat-batez atia zabaldu ta neskame bat, dotore jantzir̃a, sar̃tu zan. Buruba makur̃tu ta goxalduteko zer gura ete-eban Susane'ri ir̃andu eutson.

Neskatil̃ea jagi zan. Eta neskamiok sedazko janzkijagaz Susane jantzi eban. Onek zer esan be ezekijan.

Bar̃iro zabaldu atia ta mutil eder̃ bat sar̃tu zan, soñeko polir̃akin jantziriko mor̃oyak atzetik juaten yakozala.

Danok Susane-aur̃ian auzpeztu ta mutil̃ak esan eutson:

—Bakaldun (eṙege) baten semia naz. Baña sorgin batek, orain bost urte, agure baten bigurtu ninduban. Nire moṙoi zintzo bigaz ta onetaiko baten emaztiagaz txala, olaṙa ta olua egin ebazan. Laurok bixi biaṙ ixan geban, gura-ta-ez, oyaneko etxetxu baten. Itxura negaṙgaṙi oṙetan egon biaṙko genduban, neskatila batek etoṙi ta gu maṫasunaz erabili-aṙte. Esan dautzudazan aberioi ezeutsen jaramonik egin-eta, zure aizta bijak zulo sakonera bota nebazan. Zeuk, baṙiz, ondo zaindu ta sorginkeriṫik azkatu ta gaizkatu (salbau) gozuz. Orixe dala-ta, gura ba-dozu, Bakalduna dan nire aṫaren jauregira juango gara, alkaṙegaz ezkonduteko.

Bayetz esan baño lenago, Susane'k auxe eskatu eutson Bakaldungayari: gurasuai esateko jazoten yakona ta aizta bijok azkesteko (parkatuteko).

Ori loṙtuta, gurasuak laztandu ta Bakaldunaren etxera juan ziran, ezkontzen.

Ezkontza au zala-ta, jai andijak egin ziran.





ṘIṞIK ataz (kanpuan), txabola txiki baten, andra alargun bat bixi zan.

Txabola-aurian baratza (jardiña) eguan, eta baratzian arkakaratz (rosal) bi: bata larosa zuriduna ta bestia larosa goriduna.

Andera onek eukozan, larosa bijoen antza euken alaba bi. Oregatik, batak Edurzuriñe ixena eban, eta Loragoriñe bestiak. Neskato bijok gustiz onak eta langiliak ziran.

Edurzuriñe otzana (apala) ta baketsuba zan. Loragoriñe, bariz, bizkora ta zaratatsuba.

Oni atsegiten (gustetan) yakon, basuan ariñeketan ibiltia, lora ta mitxeletak atrapetako. Bestiak nayago ixaten eban etxian geratu, etxeko zeregiñetan amari lagunduten. Biarik (lanik) ezeukonetan, idazti (liburu) mamintsubak irakurten ebazan.

Aizta bijok alkaren mare ziran-eta, eskutik elduta olgetan juaten ziran.

Edurzuriñe'k esaten eban:

—Ezkenduban bein be batak bestiagandik aldendu biafko.

Eta Loragofiñe'k erantzuten eutson:

—¡Beti alkafen onduan ibiliko gara, il-afte!

Amak esaten eutsen:

—Zubetarik batena ixango dana, bestiarena be ixango da.

Safi, baso-ziaf ibilten ziran, lora-bila, ta bertako piztijak-eta ezeutsien kalterik egifen.

Erbijak uferatuten yakezan, neskatilak emoten eutsiezan bedafak jaten. Orkatzak (orkatz-corzo) ondora juaten yakezan, eta oreñak (orein-ciervo) saltoka ibilten ziran euren inguruban.

Txorijak be abestirik samufenakin aguf-egifen eutsien. Eta igafi-barik gaba elduten yakenian, gure neskatuok basuan geratuten ziran, bedaf-ganian etzunda, lo-egifeko.

Ama etzan ofegatik artegatuten, afiskurik (galduteko zoririk) ezeukela-ta.

* * *

Bein, basuan lo-eginda gero, goxaldijan itxaftu ziranian, ondo-onduan ikusi eben zuriz jantziriko mutiko edefa. Umiok zutundu ta begirada gozuak bota eutsezan. Baña ezer esan-barik, zugatz-aftetik juan zan.

Etxerantz ibilten asita, ikusi eben amil sakon-onduan lo egin ebela, ta zirkiñik egin-ezkero, bertora jausiko zirala. Amak esan eutsen, ume a ixango zala neskato zintzoen gotzon zaindarija (Aingeru Guardakua).

* * *

Edufzuriñe ta Loragoriñe'k ederto zainduten eben etxia

Orixe zala-ta, au garbi-garbi egoten zan.

Udan Loragoriñe'k zainduten eban. Goxian-goxian amaren gelan ipinten eban, berau itxartu baño lenago, lora-txorta edera, larosa politakin eginda.

Neguban Edurzuriñe'k egiten ebazan etxeko zeregiñak.

Gabez, edura jausten zanetan, amak esaten eutson:

—Edurnetxu,itxixu atia.

Ori eginda, su-onduan jezari, amak betaurekuak ipiñi ta zeozer irakurten eban beti. Neskato bijak, gorubari ekiñaz, adi-adi egoten yakozan. Amaren oñetan bildotsa etzun eta ate-ostian uso zurijak lo-egiten eban, egal-azpijan mokua (pikua) sartuta.

Onelan egozalarik, bein atia jo eben.

—Zabaldu egixu atia, Loragoriñe—amak esan eutson—, bidia galduta, aterpe-bila dabilan bidaztiren bat ixango da-ta.

Loragoriñe'k zutundu ta atia zabaldu eban.

Baña bidaztirik (eririk-eri dabilan gixonik) ixan -biarian, artza izan zan barura sartu zana.

Loragoriñe gustiz ikaratu zan. Bildotsa *beka* asi zan. Usuak egaz-egin eban gela-inguruban. Edurzuriñe amaren oian eskutau zan.

Alako baten artzak esan eban:

—Ez bildurik ixan, eztautzubet kalterik egingo-ta. Otzak ilik nago, ¿bai?, ta eztot gura besterik su-onduan jari ta pizkat berotu baño.

—¡Abere erukarija!—amak erantzun eutson—. Su -ondora urderatu zatez. Baña kontuz ibili ulerik ez ere-

teko. Tira, neskatiḻak,—onei esan eutsen—, etoŕi ona, artzak eztautzube kalterik egingo-ta.

Neska bijok artzagana uŕeratu ziran. Bilḏotsak eta usuak be bilḏuŕa kendu eben. Artzak, orduban, esan eban:

—Neskato matagaŕijok: ule-aŕtian daukoḏan eduŕa kendu gura ete-daustazube?

Umiak itxuskija aŕtu ta artzak eskatu eutsena egin eben.

* * *

Geruago ta adizkidetasun geyago euken aberiagaz. Uletatik tiratu, batera ta bestera erabiḻi (bultz-egiñaz), makiḻagaz jo...

Artzak ezeban ezer esaten-eta, gure neskatiḻok gura eben gustija abere eŕukaŕijagaz egin eroyen. Artzak kuŕink baño geyagorik ezeban egiŕen. Neskak, orduban, baŕe-algaraka ibilten ziran. Baña gogoŕago joten asi yakozanian, artzak esan eutsen:

—Itxi nagixube bixiŕen, ene umiok. Ezegixube senaŕgaya il.

Lotara juateko orḏuba elduta, amak artzari esan eutson:

—Su-onduan etzun, nasai-nasai, ta ezetariko ardura -barik lo-egixu.

Eta danok ogera juan ziran.

Bijaramonian, eguna zabaldu zanian, neskatiḻak atia zabaldu eutsoen artzari. Eta berau basora juan zan zuzen-zuzen, bere zeregiñak egiŕen. Baña aŕatsaldian -aŕatsaldian atzera etoŕten zan, beragaz jolastuteko (olgetako) neska bijak.

Geruago aizkidiago, geruago aizkidiago, ezeben etxekuok atia isten, artza baŕura saŕtu-barik.

* * *

—Emetik alde-egin biaŕko dot, eta neguraŕte ezingo dot atzera etoŕi.

—¿Eta nora juan biaŕ ete-dozu, artz mat̃ia?

—Basuan egon biaŕko dot luzaro, epo (enano) gaiztuakandik ogasun andijak zainduten. Neguban, luŕa gogoŕtuta dagonian, ezin ixaten dabe epuok luŕ-azpit̃ik uŕten. Baña oraingo eguraldijagaz, eskutauta dagozan zuluetatik uŕteten dira, lapuŕetan asteko. Eta ostuten dabena betiko galduta dago.

Eduŕzuriñe il̃un (triste) jaŕi zan, artzak alde-egin biaŕko ebala igaŕit̃a.

Atia zabaldu ebanian, artzak topo-egin eban moŕol̃uagaz ta naŕu-zati bat itxi biaŕ ixan eban. Gure neskatil̃ari irudi yakon, naŕu-azpijan uŕe goŕijak dis-dis-egit̃en ebala. Baña ezin ziatz ikusi, artza, ariñeketa baten, basora juan zalako.

* * *

Egunak juan egunak etoŕi, amak bidaldu ebazan alaba bijak eguŕ-bil̃a.

Onek, basora elduta, mukuŕ andija ikusi eben. Bere inguruban, bira-biraka, zeozer ebil̃an, zer ete-zan ondo ikusten ezebela baña.

Bertaratu ta ikusi eben, aŕpegi zimela ta bixaŕ zuri -luziak eukozan epo zaŕa.

Onen bixaŕen puntia mukuŕian lotuta eukon.

Gure gixontxuba, txakuřak katiagaz lez, lotuta auřkituten zan, eta ezin ezetara be azkatu. ¡Ařayopola! Neska bijoi, txinpartak botaten ebazan begijakin begiratu ta esan eutsen:

—¿Zer egiten dozube oř, tentelok, niri begira, lagunduten etoři-barik?

—¿Zer dala-ta jazo yatzu ori?—Loragořiñe'k itandu eutson.

—¡Zu zara jakingurea! Mukuř au zatitu gura ixan dot, eskaratzeko suba piztuteko, eguř andirik ezin ixaten dogu ořetarako erabili-ta. Geuk eztogu betekadarik egiten, zubek, saloberiok, egiten dozuben lez. Enboř au zatituteko ziřikituba eginda neukon, ¿bai?, baña alako baten aizkoreak laban-egin, siřikituba sařatu ta nire bixař luzia atrapau daust. Oin lotuta (preso) nago. ¿Baña zer dala-ta bařerik egiten dozube? ¡Iguingařijak zarie, benetan!

Neskatilak, epuaren esanai jaramonik egin-barik, alegiñak egin ebezan bixařa azkatuteko. Baña ezin.

—Batobati esangotsot etořteko—Loragořiñe'k esan eban.

—¡Ut ořtik, astakirtena!—epuak erantzun eutson—. Iñori detu au egiten lagunduteko? ¿Bijok etzarie naikua, ala? ¿Ez-ete-yatzube, astaputzok, ezer otuten?

—Ez lařitu—Eduřzuriñe'k esan eutson—, zeu azkatuteko bidia topau dot-eta.

Ori esanaz, sakeletik artazijak atara ta bixařaren erpiña (puntia) moztu eutson.

Epuak, buruba azke (libre) ikusi ebanian, sasi-ařtian eskutauta eukon zořua, uřez beterikua, lepuan ařtu ta, eskařik egin-barik, ariñeketiari emon eutson, esanaz:

—¡Ořek dira astotzařak! ¡Bixař edeřa moztu eztauste, ba! ¡Txeřenak (diabruak) eruango al-zaitube, madarikatubok!

* * *

Egunak juan egunak etoři, Eduřzuriñe ta Loragořiñe ařañetan juan ziran. Eřeka-onduan egozala, zauzkari (saltamatxino) bat ikusten ebela irudi yaken. Bertara eldu ta epua ikusi eben.

—¿Zer egiten dozu emen?—Loragořiñe'k esan eutson—. ¿Soña bustiten zuaz, ala?

—¿Zetarako uretara sařtu?—epuak erantzun eban—. ¿Itoteko? ¿Eztozube ikusten, ařain ziztriñok nařezka eruan gura nabela?

Ona emen zer jazo zan.

Epua asi zan ingiaz (kañabereagaz) ařañak atrapetan. Eta axiagaz bixařa itxulastu yakon kañabereagaz, ařain andi batek amubari aginkada galanta ezařten eutson unian bertan. Ořetara, ba, epuak ezeukon indařik ařaña uretatik atarateko, ta onek (ařañok) epua luřera bota ta uretara sařtu-erazo gura eutson. Epo gaxuak bedař ta adařai oratuten eutsen, baña ařañak tiratu egiten eutson-eta, geruago indařgiago (indař gitxijagoz) eguan gure gixontxuba.

Neskatilak, eřukiz beterik, besotik eldu eutsoen uretara jausi-agiñien eguanian, eta bixařa be atondu gura ixan eben. Baña gustiz naspilduta eukon-eta, bařiro artazijak atara ta moztu biař ixan eutsoen.

Epuak zutundu ta asaře bixiz esan eutsen:

—¿Uste ete dozube, ganorabako ořek, ondo egin dozubenik nire bixařa bigařenez mozturik? Oin bixař

-erdija kendu daustazube. ¿Eta zelan aurkeztuko ete -naz anayen aurian? ¡Bixitxa gustijan ortozik eta ariñeketa baten ibiliko al-zarie, oñak bideko arijakin birinduteko!

Eta eskutauta eukon zorua, pitxiz beterikua, artu ta basora zuzendu zan.

* * *

Aste batzuk geruago neska bijok urira juan ziran, arija ta jostoratzak erosten.

Alako baten, buru-ganetik egaizka ebilkijen txoritzara ikusi eben. Gerotxubago arkaitz-artera jatsi zan.

Orduban garazi bixija entzun eben.

Ariñeketan juan eta, bildur-ikaraz, auxe ikusi eben: arano andi batek, atzapar zorotzakin oratuta eukon zorijoneko epua. Egaztijaren asmua zan, itxuraz, gure gixona aidian eruan, goi-goiko arkatxetara. Neskatilak, beti onak eta zintzuak, epuari eldu ta, indarez tiratuta, lortu eben aranuaren atzaparetatik azkatu.

Epuak, bildura galdu ebanian, amuruz esan eban:

—¿Eztaukozube era edo modu oberik nigaz erabilteko? ¡Soñian neukon janzki polita uratu daustazube gustiz, astotzarok!

Ori esanda, eskutauta eukon diruz betetako zorua artuta, lurpeko zulo batera sartu zan.

Neskatilak, eskartxareko aren esanakin oruta, barriari emon eutsoen. Eta lengo bidera barriro jota, urirantz abijau ziran.

Atzera egitian, lengo lekutik igaro ziranian, epua ikusi eben, arkaitz-ganian, uria, pitxijak eta diruba

eukozana. Eguzkijaren izpijakaz dis-dis egiten eben pitxijok.

Epuak, asaŕez, esan eutsen:

—¿Ze aŕayo egiten dozube oŕ?

Beti zuri-zuri eukiten eban arpegija goŕitu yakon gustiz. Irugaŕenez bixitxea gaizkatu (salbau) eutsoen neskatilen auŕka zeozer geyago esaten asi-ordukoxe, artz baltz-andija agertu zan.

Epuak, bilduŕez, iges-egin gura ixan eban. Baña aberiak ezeutson itxi.

—¡Ene artz maŕia, baso onetako bakalduna!—epuak, auŕian auzpeztuta, esan eutson—. ¡Azketsi (parkatu) egistazu ta diru ta pitxi gustijak emongo dautzudaz! ¡Zuretzat aŕtu egixu nire uŕe gustija, baña enagixu il, enagixu jan! Nire aragija zaŕa ta gogoŕa da: ezta zeuk jateko duña. Oŕtxe daukozuz neska bi oŕek, lodi-samaŕak ixanik zure aborako alagalakuak. Ariñeketan asiko ba'litzaz be, lasteŕ atrapauko zeunkez.

Artzak erantzun ez, baña ostikada bategaz il eban epo iguingaŕija. Gero, neskatilakana juanda, esan eutsen:

—Eduŕzuriñe ta Loragoŕiñe maŕiok: itxaron pizkat.

Umiak, artzaren abots ezaguna entzunaz, gelditu ziran.

Aberia euren ondora elduta, naŕuba jausi yakon. Eta artzik agertu-biaŕian, uŕezko janzkijakin apaindutako bakaldungai (printzipe) edeŕa agertu zan.

—Neu naz bakaldun (eŕege) baten semia—aldakuntza ori ikusirik ikaratuta egozan neskatilai esan eutsen—. Eta epo (enano) madarikatu oŕek, ogasun gustija ostuta gero, sorginkeriz, artz baten itxurea emon

eustan. Bere erijotzagaz sorginkerijoi amařu ta lengo itxurea, gixonen itxurea ařtu biař ixan dot.

Danok batera juan yakozan amari, bařì pozkařija emotera.

Bakaldungaya Edurzuriñe'gaz ezkondu zan. Eta Loragořiñe'k eta aren anayak, epuaren zuluan idoro ebezan gauzak erdi-bana egin ebezan.

Ama luzaro bixi ixan zan alaba ezkondubaren onduan. Ořetarako txabola zařa laga biař ixan ebanian, arkakaratz bijok eruan euzan, jauregiko leyuan ezařita, lařosa zurijak eta gořijak emoten jařařu egijentzat.




IXON bat alargundu zan bein. Andra bateri be senaŕa il yakon.

Gixonak alaba bat eukon. Eta andreak beste bat.

Neska bijok lagunak ziran. Egurastuten alkaŕekin ibiĺita gero, andrearen etxera joten eben.

Onek esan eutson bein alabearen lagunari:

—Zu, entzun. Aŕari esayozu beragaz ezkondu gura neukela. Ori egiten ba-dogu, goxian oetik jagi ta aŕpegija esniagaz garbiŕuko dozu. Oŕez ganera, jatordubetan ardaua emongo dautzut. Nire alabeak, baŕiz, uragaz garbiŕu biaŕko dau, ta ura baño besterik eztau edango.

Neskatiĺak etxera juan eta aŕari esan eutson andreak agindutako gustija.

Aŕak burubari iŕandu eutson:

—¿Zer egin biaŕko ete-nayuan? Ezkontzea, berez, ona dok, baña orain baño lan geyago egin biaŕ ixango yuat.

Zer erabagi ezekijala, oski (zapata) bat erantzi ta alabeari esan eutson:

—Azpijan zulua daukon oski au aŕtu. Ganbarara

eruan, untze batetik eskegi ta ura bota egijozu. Urik uŕteten ezpa-da, ezkonduko naz. Urik jausten ba-da, enaz ezkonduko.

Neskatiĺak bete eban aŕaren aginduba. Urak naŕuba nasaŕu, zulua itxi ta oskija goraño urez bete zan.

Aŕari edestu eutson.

Au ganbarara igon zan, eta alabeak esan eutsona egija zala ikusiŕa, andra alargunaren etxera zuzendu ta emaztia egiŕeko eskatu eutson.

Gerotxubago bijok ezkondu ziran.

Bijaramon goxian neska bijak oetik jagi ziranian, senaŕaren alabeak auŕkiŕu ebazan: esnia, aŕpegija garbiŕuteko, ta ardaua, edateko. Bestiak ezeukon oŕetarako ura baño.

Uŕengo goxian neska bijok ura euken, garbitzeko ta edateko. Eta irugaŕen goxian, senaŕaren alabeak ura eukon garbiŕuteko ta ura edateko, ta andrearenak esnia eukon aŕpegija garbitzeko ta ardaua edateko.

Emaztiak goŕoto andija eutson alabordiari, ta ezekijan zer egin, geruago gaŕatzagua egiŕeko onen bixitxa. Bekatxa (enbirija) eukon, alabordia poliŕa ta begikua zalako, alabea itxusija ta ixakera txaŕekua zan-eta.

* * *

Luŕa leŕuta ta mendijak eta aranak eduŕez beterik egozan neguko egun baten, andreak ingizko (papelezko) janzkija egin, alabordiari dei-egin eta esan eutson:

—Janzki au jantzi biaŕko dozu basora juateko.

Malukijak jateko gogo andija daukot, ¿bai?, ta otzarabete ekaŕiko daustazu basotik.

—¡Ene bada! —neskatilak erantzun eutson—. ¡Neguban eztago maĺukirik, luŕa leŕuta ta eduŕez beterik auŕkitzen da-ta! ¿Eta zer dala-ta ingizko janzki onegaz juan biaŕko ete-dot? ¿Eztozu ikusten otz andija dagola, ta axiak eta arantzak janzkijau uŕatuko daustela?

—¿Nire aginduben auŕka (kontra) esaten azaŕtuko ete-zara? ¡Ut emetik, min geizto, ta ez etoŕi etxera otzarabete maĺuki ekaŕi-aŕte!

Gero ogi-zati bat emon eta esan eutson:

—Gauŕko janzkija auxe dozu. ¡Zuaz basora!

Eta andra gaiztuak burubari egiŕen eutson:

—Basuan otziŕu, leŕu ta gosez ilgo don. Etxonat beste bein begi-auŕian ikusiko.

* * *

Gure neskak, amordiaren agin̄duba beteteko, ingizko janzkija jantzi, otzarea aŕtu ta etxetik alde-egin eban.

Baso gustija eduŕez jantziŕa eguan. Etzan oŕi oŕlegirik (berderik) ikusten.

Bertora eldu ta etxetxu bat ikusi eban. Onen leyoetatik iru gixontxuk begiratzen eben kanpora.

Etxetxu onetara uŕeratu, atia jo ta «egunon» esan eutsen gure neskatilak.

Baŕukuak, saŕtuteko esan eutsoen.

Neskatua saŕtu, su-ondoko zuzuluban jezaŕi ta ogi-zatija jateko gertau zan.

Gixontxubak esan eutsoen:

—Ogi-apuŕik emon egiskuzu.

—Bai ta pozik be—neskak erantzun eutsen.

Ogi-zatija erdibiĩu ta erdi bat emon eutsoen.

Gixontxubak iĩandu eutsoen:

—¿Zer egin gura ete-zendun basuan, onelako otzagaz ta ingizko soñekuagaz jantziĩa?

—¡Ene eŕukaŕija! Maĩuki-biĩa bidaldu nabe, ta ezin dot etxera biguŕtu otzara au bete-aŕte.

Ogija jan ebanian, itxuskija luzatu ta esan eutsoen:

—Onegaz kendu etxe-osteko ate-auŕian dagon eduŕa.

Neskatiĩa etxetik uŕten zanian, iru gixontxubok alkaŕi esan eutsoen:

—¿Zer emongo ete-geuntson bezuzatzat (eŕegalutzat), ona ta esanekua dalako, ta, ganera, ogija geugaz erdibiĩu daulako?

Lenengo gixontxubak esan eban:

—Nik emongo dautsot, geruago edeŕagua ixatia.

Bigaŕenak:

—Nik emongo dautsot bakaldun bat, beragaz ezkonduteko.

Irugaŕenak esan eban:

—Nire bezuza auxe ixango da: itz-egingo daunetan, uŕezko txindijak (dirubak) abotik uŕtengo yakoz.

* * *

Neskatiĩak egin eban gixontxubok agindu eutsoena. Itxuskijagaz etxe-osteko ate-auŕian eguan eduŕa kendu, ta ikusi eban luŕ gustija maĩuki goŕi-edeŕez beterik eguala.

Poz-pozik otzarea bete, gixontxubai eskarak egin eta etxerantz abijau zan.

Etxera sartu ta «gabon» esan ebanian, urezko txindi bat abotik urten yakon.

Gero edestu eban basuan jazo yakona. Eta itz-egiñaz batera urezko dirubak jausten ziran-eta, berialako baten txaki (gela) gustija urez bete zan.

Ori ikusita, amordiaren alabeak esan eban:

—¡Auxe da neska zorua, itxura oretan diruba botateko!

Baña iñartzija (enbirija) eban-eta, basora juan gura ixan eban maluki-bila.

Amak, orduban, esan eutson:

—Ez, ene alabatxuba. Otz andija dago, ¿bai?, ta ilgo ziñan.

Baña ekin eta ekin eragoyon-eta, amak, azkenez, bayetz esan eutson. Naruzko janzki edera josi eban, alabeak eruan egijan,, eta biderako ogija, guriña ta opilak emon eutsozan.

* * *

Neskatilea basora eldu ta, zuzen-zuzen, etxetxura juan zan.

Iru gixontxubok leyotik begira egozan, baña neskiak ezeutsen jaramonik egin. Eta baimenik eskatu-barik, barura sartu, su-onduan jari ta jaten asi zan.

—Zeozer emon biarko zeunskun—gixontxubak esan eutsoen.

—Niretzat naikua eztaukot-eta, ¿zubei emotia gura ete-dozube?

Jan ebanian, gixonak esan eutsoen:

—Eutsi itxuski au ta zuaz kanpora, etxe-osteko eduŕa kenduten.

—¡Juan eta kendu zubek, lelotzaŕok! ¡Ni enozube etxeko neskamia (kriadia)! ¡Olakorik!...

Neskatiĺak igaŕi eban ezeutsoela bezuzarik emongo. Eta orduban uŕten zan.

Ori ikusita, iru gixonok alkaŕi esan eutsoen:

—¿Zer emongo ete-geunskio, oŕen gaiztua ta lotsagaldukua dan ezkero?

Lenengo gixontxubak esan eban:

—Nik bezuzatzat emongo dautsot, geruago itxusijagua ixatia.

Bigaŕenak:

—Nire bezuzea auxe ixango da: itz-egingo daun bakotxian, abotik sapu bat jausiko yako.

Irugaŕenak esan eban:

—Niria, era edo modu txaŕian iltia.

* * *

Neskatiĺa maĺuki-biĺa asi zan. Baña topau ezin.

Orixe zala-ta, etxera biguŕtu zan gogaro (umore) txaŕagaz.

Basuan jazo yakona amari edestuten asi yakonian, itz bakotxagaz sapu bat botaten eban. Oŕegatik danon iguingaŕi ixan zan.

* * *

Amordiak, geruago amuŕatubago alabordia geruago poliŕago egualako, zer asmau ezekijan neskatiĺari kalterik geyen egiŕeko.

Ibiľi ta ibiľi, auxe otu yakon bijotz gogoŕeko andreari: galdara bat sutan ipiñi ta bańura ari-matazak bota, egosteko. Orixe eginda, matazok neskiaren sorbalda -ganian ezańi euzan, eta aizkora bat emon eutson, leťuta eguan eŕekara juan edintzat, matazak garbiťuten.

Neskatiľa juan zan. Eta lei-ańtian zulua egiten asten zalarik, zalpurdi (zaldi-burdi) galanta agertu zan. Bertan etońana Bakalduna zan.

Zalpurdija geldiťu ta Bakaldunak ńandu eutson:

—Zu, neskato: ¿nor ete-zara ta zer egiten ete-dozu emen?

—Iñoren laguntasunik eztaukodan neska eŕukańija naz. Ari-mataza onek garbiťuten nago.

Bakaldunak, eŕukiťuta, polit-poliťa zala ikusi ebanian, esan eutson:

—¿Nigaz etońi gurako ete-zenduban?

—Bai, ta pozik be.

Zalpurdira igon eta Bakaldunagaz juan zan.

Jauregira elduta, andikiro ospatu zan bijoen ezkontzea.

* * *

Urtebete-bańu, Bakaldun-emaztiak sein-egin eban. Amordiak jakin eban neskatiľaren zorijona. Orduban otu yakon bera ikusten juatia.

* * *

Bein, Bakalduna atan (kanpuan) eguala, emakume ankeŕak jauregira sańtu ta Bakaldun-emaztia ańtu ta

leyotik eřekara bota eban, alaba gaiztuak lagunduta. Ori eginda, alaba au oera sartu ta atsuak bururaño estaldu eban.

Bakaldunak atzera etoři ta emaztiari itz-egin gura ixan eutsonian, atsuak esan eutson:

—¡Zagoz ixilik! Emaztia gexorik eta ixerditan dozu. Gauř bakian itxi biařko dozu.

Bakaldunak ezeban susmau ezer.

Uřengo goxian etoři zan bařiro. Emaztiari itz-egin eutson. Eta onek erantzuteko itz-egin eutsonian, itzakin batera sapubak uřteten yakozan abotik, uřezko txindijak uřten-biařian.

Ori ikusita, Bakaldunak itandu eban zer zala-ta aldakuntza a. Baña atsuak erantzun eutson, ixerdijak eragiten eutsola ori, ta osatuzkero uřia botaten asiko zala.

Baña gaberdijan jauregiko mořoyak ikusi eben arata bat sařtuten zala. Sařtu ta itandu eutsen:

—¿Zetan zagoze? ¿Lotan ala itxařtuta?

Ezeutson iñok ezer erantzun. Orduban itandu eban:

—¿Zer egiten ete-dabe nire jatetubak (konbidauak)?

Eta mořoyak erantzun eben:

—Lo-zořuan dagoz.

Aratak itandu eban:

—¿Zer egiten ete-dau nire semetxubak?

Mořoyak erantzun eutsoen:

—Siaskan lo dago.

Orduban, Bakaldun-emaztiaren itxurea ařtu, semetxubari titia emon, siaskan ezaři, arata-antza bařiro artu ta eřekara zuzendu zan.

Bijaramoneko gabian be orixe egin eban.

Irugařen gabian aratak esan eutsen mořoyai:

—Zuaze Bakaldunagana ta nire partez esayozube ezpatea aŕtu ta nire buru-ganera iru bidaŕ jasoteko.

Moŕoyak egin eben aratearen aginduba.

Bakaldunak ezpatea aŕtu ta iru bidaŕ arata-buru -ganera altzau eban. Bat-batez, lengo emazte bixija ta edeŕa agertu yakon.

Bakalduna gustiz poztu zan. Eta emaztiari esan eutson uŕengo iganderaŕte eskutetako.

Igandian umia ugutzau (batiatu) eben. Eta ori eginda, Bakaldunak iťandu eban:

—¿Geidia (lagun-urkua) oetik atara ta eŕekara botaten daun notin (persona) ankeŕ-gaiztuak zer ibazten (merezi) ete-dau?

—Olako notiñak mereziduten dau—atsuak erantzun eban - upa batera saŕtu ta eŕekara botatia.

Bakaldunak, orduban, esan eutson:

—Zeure burubari epaya (sententzija) emon dautsozu.

Eta atsua ta alabea era oŕetan il ziran.





ṘANTZALIA emaztiagaz bixi zan txabola zaŕ ta txikijan, itxaso -aldian.

Gure gixona (Kepa ixena eukona) egunian-egunian juaten zan atxetara, ingiaz ta amubaz aŕañak atrapetako asmoz. Baña saŕi, luzaro egon eta etxera esku-utzik etoŕi biaŕ ixaten eban.

Bein aŕain edeŕa atara eban.

—Aŕen eskatuten dautzut—aŕañak esan eutson—bakian eta bixirik itxi nagixun. Ni enaz benetako aŕaña, bakaldungaya (prinzipia) baño. Oin, sorginkerijen bidez, itxura negaŕgaŕi onetan buruba ikusten dot. ¡Bakian itxi nagixu, aŕen! ¡Azkatasuna emon egistazu, ori baño beste ogasunik eztaukot-eta!

—Eztozu besterik esan biaŕ—Kepa zintzuak esan eutson—. Itz-egiŕen dakijan aŕañak, ori baño geyago be merezi dau.

Eta amuba kenduta, aŕaña itxaso-ondora juan zan, bidian odola erijola.

* * *

Etxera elduta, emaztiari edestu eutson jazo yakon gustija.

—¿Eta ez-ete-dautsozu ezer eskatu?—emaztiak esan eutson.

—¿Zer eskatuko neutson, ba?

—¿Ezta gauza lotsagaŕija txabola zaŕ ta txiki onetan bixi biaŕ ixatia? Etxe andijagua ta obia emoteko eskatu biaŕko zeuntson.

***

Gure aŕantzaliak ezeban uste, Bakaldungai gaxuari egindako eskaŕak (mezediak) sari andirik mereziduten ebanik. Oŕaŀiño, baña, atxetara zuzendu zan. Eta itxaso-aldian jaŕiŀa, didaŕ-egin eban:

—Ene aŕaña, ene aŕain maŀia! Emaztiak esan daust, zeuri gauzatxu bat eskatuteko.

Berialako baten aŕañak agertu ta erantzun eutson:

—¿Zer gura ete-dau, ba?

—Berak uste dau, mezede bat egin biaŕko zeustala. Etxe andijagua ta obia gura dau, orain daukogun txabolaren ordez.

—¡Tira, ba! —aŕañak erantzun eutson—. Emaztiagana juan zaŀez ta etxe baŕija ikusiko dozu.

***

Kepa'k, emaztiagana biguŕtu zanian, etxe baŕiko atian jezaŕiŀa eguala ikusi eban.

—¡Arin etoŕi! —emaztiak esan eutson—. Erdu ikusten etxe polit-edeŕ au. Txaki edeŕ bi daukoz, eskaratza ta atzeko aldian ukuŀuba, oŀuak-eta ipinteko.

Egazti ugari dago bertan. Inguruban baratz txikija, eltzari ta lorakin.

—¡Ointxe bixiko gara ederto! —Kepa'k esan eban.

—Bai —emaztiak erantzun eutson—. Orain bai daukot, bixitz gustijan gura ixan dodana.

* * *

Lenengo amabost egunetan pozik eta zorijontsu bixi ixan ziran. Baña alako baten emaztiak esan eban:

—Zu, Kepa. Etxe au txikijegija da guretzat. Baratza be eskuba-lakoxia da. Ni zorijontsuba ixango nintzake jauregi ederra euki-ezkero.

—Ondiño eztira amabost egun baño bakaldungai onak onelako etxetxu polita emon euskunetik. Politagorik ezin asmau. ¿Eta oin diñozu ostera be beragana juateko beste gauza baten eske? Asarratuko zan nigaz, ¡bai bein!

—Oker zagoz uste oretan. Bakaldungayak eztau gura besterik gu pozik euki baño. Zuakijoz, ba, ta esan dautzudana eskatu egijozu.

* * *

Arrantzalia atxetara zuzendu zan.

Itxasua bare eguan.

Atxetatik oyu-egin eban:

—Ene araña, ene arain matia! Emaztiak bidalduten nautzu barriro, beste gauza bat eskatuten.

—¿Eta zer ete-da emaztiak gura dauna?—uretatik buruba atarata arañak erantzun eban.

—Kontuxu—Kepa'k, lotsaz gorrituta, esan eutson—

emaztia lengo etxetxu poliťagaz aspertu dala onezkero. Orain ařizko jauregi andija gurako eban.

—Zuaz emaztiagana. Ara-orduko, emaztiaren gurarija beteta egongo da.

* * *

Etxera eldu zanian, ařantzalia gelduta lotu zan, emaztia jauregi edeřian ikusi eban-eta.

—¡Ori da ařain ona! —emaztiak esan eban—. ¡Orain emon dauskun jauregija ezta edozelakua!

Bařura saŕtu ziran.

Zurubija (eskiľeria) ařri-nabařezkua zan. Mořoyak, uřezko janzkijakin apainduta, batetik bestera ibilten ziran. Etxeko jauna ta andria ikusita, buruba luřeraño makuřtu ta atiak zabalduten eutsiezan. Txakijak (gelak) eředixa edeřakin apainduta egozan. Jauregi-ostian baratz andija eguan: baratzian, gustiťariko lorak. Baratz -aldian, zugazti andija, txoriz ta basauntzez beterik. Jauregiko alde baten, ukuľubak, zaldi ta zalpurdi galantaz ornidụta. Korta baten abelgořijak egozan.

—¡Geuria ixan da zorijona! —gixonak esan eban, begijakaz ikusten ebana siñistu-eziñik—. Orain uste dot eztozula besterik eskatuko, ba.

—Ori oldoztuten (pentsetan) nago—emaztiak erantzun eutson—. Baña bijař esangotzut.

Mořoyak ekaři eutsien apari edeřa janda gero, oera juan ziran.

* * *

Uřengo egunian, eguna zabaldu zanian, emaztiak ukonduagaz senařa jo ta iratzařtu eban. Gero esan eutson:

—Jauregi au daukogunezkero, lur̄alde onetako jabiak ixan biarko gintzakez. Esan gura dautzut, lur̄alde onetan dagozan gauza gustijak geuriak ixan biar̄ko zirala.

—¿Zer, ba? ¿Er̄egiña ixan gura ete-dozu, ala? Nik beintzat eztot nai Bakalduna ixan.

—Zeuk, ez, baña nik, bai. Nik Er̄egiña ixan gurako neuke. Tira, jagi, jantzi ta itxasora juan zar̄ez, ar̄añari esaten ointxe esan dautzudana.

* * *

Ar̄antzaliak, lenengo jaramonik ez, baña gero egin biar̄ ixan eban emaztiak aginduten eutsona.

Atxetara eldu ta erdi-asar̄ez eguan itxasua ikusi eban. Beriala didar̄-egin eban:

—Ene ar̄aña, ene ar̄ain mar̄ia. Emaztiak, nik gura ixan ez-ar̄en be, beste gauza bat eskatuten dautzu.

—¿Zer nai ete-dau, baña?—uretatik buruba atarata ar̄añak ir̄andu eutson.

—Orain otu yako Er̄egiña ixatia.

—Etxera juan zadiz. Bertara orduko, emaztia Er̄egiña ixango da.

* * *

Egin-egiñian be, Kepa etxera eldu zaneko, ur̄ezko bakaulkijan (tronuan) jezar̄ir̄a emaztia topau eban. Buruban burestun eder̄a eukon. Inguruban andera dotoriak egokijozan, burutik oñetaraño ur̄ez ta pitxiz apainduta.

Jauregi-atian (esan-biar̄ik eztago jauregi au lengua baño eder̄agua zala) gudarijak (soldauak) ebiltzan batetik bestera, margo (kolore) askodun jantzijakin. Eres-

batzak eresi (soñu) politak joten ebazan. Eta moroyak, iñurijak letxe, ate gustijetatik sartu-urteten ziran.

—Orain uste dot, ba, besterik eztozula eskatuko —arantzaliak esan eutson emaztiari—. Iñor baño txiruagua zana, egun batzutan Eregiña ixatera eldu da.

—Bai—emaztiak erantzun eban—. Onelan ederto bixiten da. Baña au baño obia be ba-dago. Len etxatan otu. Nik Kaisar-emaztia (Emperatriz) ixan naiko neuke... Obeto esanda, Kaisara (Enperadoria). ¡Bai, bai, Enperadoria!

—¡Baña, umia, zeuk zentzuna galdu dozu, itxuraz! Ez; ni enaz olako lelokeririk eskatzen arañagana juango. Ibili ta ibili, onek aspertu ta eztaust jaramonik egingo.

—Eztago beste biderik. Zeuk egin biarko dozu aginduten dautzudana. Eregiña naz, ¿bai?, ta zu nire menpekua. Aide baten egixu esan dautzudana.

* * *

Kepa itxaso-aldera zuzendu zan, alperik juango zalakuan.

Atxetara elduta, idazkura (tintia) baño baltzago itxasua eguala ikusi eban. Axe indartsuba ebilan-eta, uin (olatu) andijak atxetara joten eben, bits zurija erijoela.

—¡Ene araña, ene arain maitia!—oyu-egin eban—. Emaztia ezta asetu. Ondiño geyago gura dau.

—¿Zer gura ete-dau, ba?—uretatik buruba atarata arañak itandu eutson.

—Arokerijak zentzuna galdu-erazo dautso-ta, Kaisara ixan gura ei-dau.

—Zuaz etxera ta Kaisara eginda topauko dozu.

* * *

Kepa'k atzera egin eta gauza ikaragaŕijak ikusi ebazan. Lengo jauregija eguan tokijan oin beste jauregi edeŕagua eguan, atxurdiñez (marmolez) eginda. Jauregiko sabaya uŕezkua zan.

Jauregira saŕtu ta lenen-lenen gixa-irudi (estatua) galantak ikusten ziran. Onen aŕtian iŕuŕi poliŕak egozan, usain gozodun urak jarijoten ebezanak.

Margo askodun gudari-aŕtetik igaro ta gela edeŕ batera eldu zan gure gixona. Txaki onen erdi-erdijan bakaulki andija eguan, uŕez ta pitxiz eginda. Bakaulkijan (tronuan) jezaŕita, emaztia auŕkitzen zan.

Beronen janzkijak esan eziñala txindi balijo eben. Janzkijok pitxiz ta uŕez josiŕa egozan. Inguruban, bakaldeŕiko (eŕeñuko) agindari ta nagusijak eukozan, bere auŕian buruba makuŕ-makuŕ egiŕen ebela. Aŕantzaliaren emaztia poz-pozik eguan itxura atan.

—Orain —Kepa'k esan eutson— uste dot pozik egongo zarala. Zeuria lako zorijonik ezta iñoz ixan ludijan.

—¡Bijaŕ esango dautzut! — emaztiak erantzun eutson.

Asmau leikezan janaririk gozuenak apalduta gero, lotara juan zan. Baña ezin lorik egin. Oldozten (pentsetan) eguan, ori baño obia be jaritsi eikiala.

Uŕengo goxian, jagi zanian, ortzian (zeruban) odeyak egozala ikusi eban.

—Nik eguzkija ikusi gura nayeuken — kolkorako esan eban — ta odei oŕek etxausten isten. Baña eguzkija atarateko, Jaungoikua beste ixan biaŕ. ¡Orixe, bai! ¡Jaungoikua baxen altsuba ixan gura ta ixan biaŕko yonat!

Pozik senaŕari esan eutson:

—Zu, Kepa, jantzi zaŕez beingo baten eta aŕañagana juan, Jaungoikua'k beste almen euki gura dodala

esaten. Eguzkija, odeyak-eta erabili biaŕ dodaz nire gustora, ta oŕetarako Jaungoikua baxen altsuba ixan biaŕ. Aŕañak eztautzu ezetzik esango.

—¡Baña umia, zu gustiz zorua zara!—aŕantzaliak esan eutson, zentzun-gabeko itz arek entzunda—. ¿Ez -ete-daukozu naikua eŕi onetako Kaisara ixanaz?

—Ez, mingaŕija yat Eguzkijari, Ilargijari ta Ixaŕai agindurik ezin-emotia, gura neuken lez ibili edixan. Ortze gustijan agindu gura neuke, Jaungoikoa'k berak lez.

—Baña ori ezingo dautzu aŕañak emon, oŕelako almenik eztau eukiko-ta!

—Enperadoriak agintzen dauna egin biaŕ da, ta aguro egin gero!

* * *

Kepa gixaxua, laŕi ta estu, ibilten asi zan.

Itxasua gustiz asaŕe eguan. Ekaitz andija zan-eta, basoko zugatzak luŕa joten eben eta itxaseŕtzeko atxak igiŕuten ziran. Uñak (olatubak) ikaragaŕijak ziran eta bata bestien ondoren arkatxetara jo ta dunbada andijak egiŕen ebezan.

—¡Ene aŕaña, ene aŕain maŕia! —Kepa'k esan eban—. Emaztiak, neuk gura ixan ez-aŕen be, azkenengo gauzea eskatu gura dautzu.

—¿Zer ete-da, baña, eskatuten dauna? —uretatik buruba atarata, aŕañak iŕandu eutson.

—Esaten be enaz azaŕtuten — Kepa'k erantzun eban—. Urtz gure Jauna baxen altsuba ixan gura ei-dau.

—Zuaz beragana, ¿bai?, ta antziñeko txabola zaŕ ta txikijan auŕkiŕuko dozu.

* * *

Aŕañak esan ebana jazo zan.

Kepa'k, etxera biguŕtuta, ikusi eban lengo jauregi

ta gauza gustijak ayenatuta (alde-eginda) egozala. Eta emaztia, janzki uŕatubagaz jantziŕa, txabolako atian jezaŕiŕa auŕkitzen zan.

Baña aŕantzalia etzan oŕegatik estutu. Sariak aŕtu ta aŕañetan juan zan.

Emaztiak ezeban euki aŕezkero bakerik, ez zorijonik.





ON saspi urte eguan aberats baten etxian, moŕoya lez.

—Jauna—esan eutson bein—, bijok alkaŕegaz iŕundu genduban moŕoi-aldija beteta daukot, ¿bai?, ta oin amaren etxera juan gura neuke. Emoistazuz, bada, irabaziŕa daukodazan alogerak.

—Moŕoi zintzua ixan zayataz-ta—ugazabeak erantzun eutson—sari ona emongotzut.

Eta uŕe-zati andija emon eutson, Jon'en buruba baxen andija, bai.

* * *

Mutiĺak uŕia aŕtu, zapijagaz batu ta, sorbaldan ezaŕiŕa, amaren etxerako bidera jo eban.

Ibiĺi ta ibiĺi, zaldi edeŕ baten ganian joyan gixon bat auŕkiŕu eban.

—¡Ene bada!—Jon'ak esan eban—. ¡Gauza edeŕa da, ziñez, olako zaldi baten ganian juatia! Gixon au arkoloka dua jezaŕiŕa, bideko aŕijakin eztau oñetan miñik aŕtuten, oskirik (zapatarik) eztau apuŕtuten eta nekatu -barik, patxada edeŕian, gura daun lekura juaten da.

—¿Eta zeu—zaldi-gixonak, ori entzunda, iŕandu eutson—¿zer dala-ta oñez zuaz, bada?

—Beste erarik (modurik) eztaukodalako. Zama (karga) aztuna eruan biaŕ dot etxera. Uŕegoŕija da, bai,

ziñez, baña oraïño min andija egiten daust lepuan. Orixe dala-ta, buruba tente ezin dot euki.

—Orezkero, gauza bat esango neutzun. ¿Ordeztu edo trukau gurako ete-zeunstan? Nik zaldi eder au emongo neuskixu eta zeuk, onen truke, ure-zatijoi.

—Bai ta pozik bere. Baña auretik esan biar dautzut gustiz aztuna dala.

Zaldidunak lurera jatsi, ure-zatija artu ta Jon'i lagun -egin eutson zaldi-ganera igoten.

—Axia baxen arin juan gura dozunetan «¡tirok!», «¡tirok!» zaldijari esan baño besterik eztozu biar.

* * *

Jon gustiz zorijontsuba zan zaldi bizkor-eder aregaz. Arin-arin juan gura ixaten ebenetan, «¡tirok!», «¡tirok!» zaldijari esaten eutson. Eta au axia baxen arin juaten zan.

Baña alako baten, ¡plausta! egin eban. Ora or gure mutila lurian, luze-luze etzunda.

Zaldija ariñeketan joyan. Baña bei bategaz etoran baseritarak zaldijari oratu ta ai eneka eguan jabiari ekari eutson.

—¡Zaldi-ganian ibili biar ixatia ezta gauza on-ona, ba!—asare bixiz Jon'ak esan eban—. Ezta atsegingarija, noxian-bein onelako zartadarik artutia. ¡Enaz beste bein zaldi-ganera igongo, buruba apurtzerik eztot nai-ta! Zeuria lako beirik ba'neuko, ¡neu ixango nintzake zoruntsuba! Nasai-nasai ta ezeren bildur-barik bere onduan juan naikua da, esnia, gastaya ta guriña, nai-aña, eukiteko. ¡Eztakit zer emongo neuken olako abelgorirk eukiteko!

—Gura ba-dozu—lugiñak erantzun eutson—beya emongo dautzut zaldijaren ordez.

Jon'ak, pozik, bayetz erantzunda, lugiñak zaldi

-ganera igon eta ariñeketa baten andik alde-egin eban.

Biłartian Jon zuřak, burubari egiten eutson:

—¡Neu ixan nok zuřa! Truke onegaz asko irabazi yuat. Gose ba-nok, guriña ta gastaya jango yuadaz. Egaři ba-nok, esne ugari eukiko yuat. ¿Geyagorik eskatu biařko ete-nayuan?

Ostatu batera eldu ta sařtu zan.

Bixitz gustirako biařko eban gustija eskuban eukola uste-ixanda, bidian jan ebazan aldian eukozan gauza gustijak. Eta garagardauaz (zerbeziaz) gastau eban azkenengo txindija. Gero beyari eldu ta bidiari ekin eutson.

Eguzkijak gogoř joten eban.

Eguberdijan, zugatzik ezeguan leku baten eguala, beruaren beroz, abo-sabayan iratzita eukon miña.

—¡Auxe dok berua! ¡Auxe egařija, mila ařayetan! Baña eztok ardura. Beyari esnia atarata, betekada galanta egingo yuat.

Beya aři baten lotu ta esnia batuten asi zan. Baña esku bijakin gogoř estutu-ařen, esne-tantarik ezeban ataraten. Esnia iratsiten ezekijan-eta, aberiari min egiten eutson.

Alako baten ostikada eřimia jaurti eutson beronek, eta ankaz gora bota eban gure mutila.

Zorijonez, lasteř bertaratu zan, burdi baten bařuban txařija eroyan eguřgiña.

—¿Zer jazo-ete yatzu, baña?—Jon'i itandu eutson, zutunduten lagundubaz.

Mutilak edestu eutson jazo yakon gustija.

Eguřgiñak, zato bat luzatu ta esan eutson:

—Ařtu egixu ardao-dangada ona. Ořek bizkořtuko

zaṙu. Eta ezta aṙitzeko bei onegandik esnerik ez atara-tia, ezer eztauko-ta. Abere au gustiz zaṙa da, ¿bai?, ta burdijagaz soluan ibilteko baño ezta gauza. Edo-ta okeletarako.

—¡Ene eṙukaṙija!—Jon'ak esan eban, uletatik tiraka—. ¿Nok esango eustan olakorik, zaldijagaz trukau nebanian? ¿Eta zetarako olako aberia il, bei-okelea etxat atsegin-eta? ¡Txaṙikija ba'litz. ¡Auxe bai-da aragi gozua!

—¡Tira, ba! Gura ba-dozu ta zeuri atsegiña emotiaṙen bakaṙik, txaṙija emongo dautzut beyaren ordez.

—¡Jaungoikua'k ordainduko al-dautzu nigaz egiṙen dozuna!

Jon'ak beya itxi ta txaṙija aṙtu eban, oṙetarako burditik eratsiṙa.



Tapa-tapa, ba-dua gure gixona, pozik eta zorijontsu, begijetatik saṙtuten yakozan gauza gustijak poza ta zorijona emoten dautsoezalako. Axe gura ta axe loṙtu...

Ibiṙi ta ibiṙi, arata zurija beso-pian ekaṙan mutil bategaz topo-egin eban.

Alkaṙi aguṙ esanda gero, izketan asi ziran. Jon'ak edestu eutson ugazabaren etxetik uṙten zanetik jazo yakon gustija Bestiak esan eban, arata zuri edeṙa ondoko eṙira eroyala, uṙengo egunian ospatuko zan ezkontza baterako.

—Beitu zelako pixua daukon—Jon'i esan eutson—. Uste dot gustiz aztuna dala. Baña oṙetarako, iṙabete bi onetan gixenduten euki biaṙ ixan dot. Jatekorik onenak emon dautsodaz lodiṙuteko. Agiñak ezaṙiko dautsozanari, aboko alde gustijetatik koipia jarijongo yako, ta ugari jarijon gero...

—Bai, benetan—aratea eskuban aŕtuta, Jon'ak esan eban—. Egazti edeŕa da, baña nire txaŕija be ezta edozelakua.

Bestiak ezeutson ezer erantzun. Baña artega ta laŕi ba'lego lez, alde gustijetara begira jaŕi zan. Gero esan eban:

—Zu, txaŕijaren ipuña eztago argi. Jakin dodanez, oraintxu igaro edo pasau dodan eŕiko alkatiari olako abere bat ostu dautsoe kortatik, ¿bai?, ta ustot zeuk daruazun txaŕi berbera dala. Txapel-okeŕak aŕapatuko ba'zind̄ubez, espetxera (kartzelera) eruango zind̄ukiez. ¡Kontuz ibiĺi, ba!

Itz onek entzunda, Jon'ak, dardarez, esan eutson:

—¡Ene Jauna, eŕukiŧu zadiz nigaz! Zeuk luŕalde au obeto ezautzen dozu-ta, eŕazago ta obeto iges-egingo zeunke txapel-okeŕakandik. Eutsi txaŕija, ba, ta ekaŕi egistazu aratea.

—Nik eztot truke onegaz ezer irabazten—aratadunak erantzun eutson—, baña buruba laŕi ikusi eztagixun, emongo dautzut egaztija.

Orixe esanda, txaŕija aŕtu ta eruan eban.

Jon zintzua, alai ta pozik, baŕiro ibilten asi zan. Eta bidiari ekiŧen eutsolarik, kolkorako esaten eban:

—Ondo pentsau-ezkero, truke onegaz be irabazi egin yuat. Aratakija (arata-okelea) txaŕikija baño gozuagua dok. Ori alde batetik. Bestetik, egazti onen egakijakin (lumakin) burko bat egingo yuat oerako. Burko au edeŕto etoŕiko yatak gura yuadanian lo-egiŧeko. ¡Amaren poza ixango dok poz andija, egazti au ikustian!

* * *

Ibiři ta ibiři ta amaren eřitik uř eguala, zořoztaře bat topau eban, txiřinga-onduan eguana. Txiřingea bira -biraka ebiřan biřaŕtian, esaten eban:

—Artazijak, aiztuak eta labañak zořoztuten dodaz aide baten eta sekulako edeřtoen.

Jon geldiřu ta begira jaři yakon.

—Itxuraz, asko irabazten dozu—zořoztařiari esan eutson—, pozik abestuten dozu-ta...

—¿Irabazi ez?—bestiak erantzun eutson—. Onelako bixibidiak uřia euřez ekaŕten dau. ¿Baña nun erosi ete-dozu arata edeř au?

—Txaři baten ordez aŕtu neban.

—¿Eta txařija?

—Bei baten truke.

—¿Eta beya?

—Zaldi baten ordez.

—¿Eta zaldija?

—Uře-zati andi batenez.

—¿Eta nok emon eutzun uřia?

—Ugazabak, saspi urteko saritzat.

—¡Tira, ba! Igaŕten dodanez, mutil zuřa zara. Eta ořetara ba-zuaz, lasteř aberastu biaŕko dozu.

—¿Aberastu? ¿Zelan aberastu, baña?

—Aŕtu nire bixibidia. Ořetarako, lenen-lenen biaŕko dozu aři bat. Enparaba berez etořiko yatzu. Nik ba -daukot aři bat, pizkat gastata dagona. Pozik emongo neuskixu, aratea zeuk emongo ba'zeust. ¿Zer deritxozu?

—¡Tira, ba!—Jon zuřak erantzun eutson—. Lasteř aberastu biař ba-dot, zeuk diñozunez, eztot min-atsekaberik eukiko. Ludiko gixonik zoruntsubena ixango naz.

Ori esan eta aratea zořoztařiari zuzendu eutson. Onek, bere ordez, ezetarako balijo ezeban ařija emon

eutson. Ořez ganera, bidian ařtutako beste aři bat be emon eutson.

—Eutsi—Jon'i esan eutson—. Ganez damotzut aři edeř au, untziak zuzenduteko ta peřak atonduteko alagalakua. ¡Kontuz ibili beragaz!

Jon'ak aři bijok ařtu ebazan. Eta pozik zuzendu zan etxera.

***

Goxetik oñez ebilan-eta, nekatuta eguan.

Gose zan eta ezeukon abora eruatekorik.

Nekez joyan auřera, aři bijok aztun-aztunak ziran-eta.

Asko ibilita gero, ituři batera eldu zan.

Eldu, ura edan eta bedař-ařtian etzun zan.

Ařijak galduteko bilduřez eřeka-onduan ezaři ebazan. Gero bera jatsi zan txapelagaz ura ařtuten. Baña igaři-barik, ařijai ukonduagaz bultz-eginda, dinbilin-danbalan, uretara jausi ziran. Eta ezin atara bertatik.

 Aři-barik geratu zanian, eskařak egin eutsozan Jaungoikua'ri, alako gauza aztunak kendu eutsozalako. ¡A zan nekia! Sořbalda-ganian aři arek erabili biař!

—Orixe baño besterik enayuan biař. ¡Orain nok, egiz ta benaz, ludiko gixonik zorijontsubena!

Eta bijotz alayagaz, besterik ezeukon-eta, bidiari bařiro ekin eutson. Eta etzan gelditu, amaren txabolara eldu ta oni laztan-laztan egin-ařte.





OTXEÑ'KO gixon batek asto bat eukon antzin-antziñetik.

Onek, urte askotan lanari ekin eta ekiñaz, galduta eukozan indaŕak eta adore gustijak. Orixe zala-ta, geruago lanik gitxijago egiten eban gaxuak.

Ori ikusiŕa, jabiak geruago jateko gitxijago emoten eutson.

Gure astuok igaŕi ebanian alako baten naŕu-apaintzaliagana (kurtidoriagana) jabiak bidalduko ebala naŕuba eratsiŕen, kortatik iges-egin eban.

Iges-egin eta belaŕijetara izpaŕ pozkaŕija eldu yakon: Brema uriko endoriak (alkatiak) asmua eukon abestaldia (abeslari-taldia) egiŕeko, udalaren (ayuntamentubaren) lepoz.

Orduban erabagi eban Brema'ra juatia, abots edeŕa ei-eukon-eta.

* * *

Ibili ta ibili, epeŕ-txakuŕ bat auŕkiŕu eban bidian. Txakuŕoi auts-aŕtian jezaŕiŕa eguan, gaŕazika.

Astuak ifandu eutson zer zala-ta gafazi arek egiten euzan.

—Ludi onetan zuzentasunik eztago-ta, atsekabez beterik aufkitzen naz. Urtiak juan urtiak etofi, gustiz zaftu naz, ¿bai?, ta enaz len baxen arin ibilten. Eta, jakiña, epefak burla-egiten asi yataz. Eta ugazabak, urte asko ta askotan ekafi dautsodazan epefak aiztuta, il gura ixan nau, ezetarako gauza enazala esanda. Baña nik ori baño len igesari emon dautsot, ¡Ostantzian!... Baña ¿zelan atonduko ete-naz orain bixi-ixateko

—Ez estutu, gixona—astuak erantzun eutson—. Brema'n abeslari-bila ei-dabiltz, ta neugaz juan biafko zendun bertara. Neu abesperena (bajo) lez aufkeztuko naz. Zeuk abespeitija (barítono) lez egon biafko zeban.

Txakufak bayetz esan eutson beriala. Eta beste barik, bijok alkafegaz ibilten asi ziran.

* * *

Ibili ta ibili, katu bat topau eben.

Au, bide-onduan jafita, itun (triste) aufkituten zan.

—¿Zer jazo ete-yatzu ofen itun egoteko?—astuak itandu eutson.

—¡Itun egongo enaz, ba!—katubak erantzun eban.— Esan leike, oraingo alatzez (mirariz) bixi nazala. Gaste -gastia enaz-ta, gurago ixaten dot sutonduan luzetara etzunda egon, sagu-atzetik ibili baño. Baña etxeko andreak olakorik eztau gura. Ofegatik afapau gura ixan nau, efekara botateko. Zorijonez, iges-egin dautsot. Baña orain eztakit zer egin bixi al-ixateko.

—Tira, katutxu, nasatu zatez—astuak esan eutson—ta Brema'ra lagundu gagixuz, bertan abeslarijak biaf

ei-dabez-ta! Zeu edeŕto egongo ziñian, uŕian, abetzolijak lez abesten.

Katubari atsegin ixan yakon astuaren asmua.

Eta irurok alkaŕekin batu ta Brema'rantz abijau ziran.

* * *

Basetxe baten ondotik igaro ziranian, abestiari gogoŕ ekit̃en eutson ol̃aŕa ikusi eben.

—Oŕetara luzaro jaŕat̃u-ezkero—astuak esan eutson—leŕtuko zintzakez. Ol̃aŕen ekanduba ezta itxura oŕetan egun gustijan abestuten egotia.

—Baña niri zoritxaŕ andija jazoten yat—ol̃aŕak erantzun eutson—. Etxeko andreak jatet̃ubak (konbidauak) daukoz bijaŕ, ¿bai?, ta euroi jaten emoteko bixitxa kendu gura daust. Eskatseñari (eskatzeko gixonari) esan dautso, niri samea biguŕtzeko. Orixe dala-ta, kukuŕukuka nabil, erdi kokolotuta, nire zoritxaŕagaz ez gomutetako.

—¡Tentela ixan biaŕko zenduban, aŕayetan, ilteko egunari buruz ba'zengoz!—astuak esan eutson—. Brema'n abeslari onak biaŕ ei-dabez, ta bertara guaz. Zeugaz lauko poliŕa egingo gendun. Etoŕi gura ba-dozu, abeskoren (tiple) edeŕa ixango zintzan.

Ol̃aŕak bayetz esanda, laurok Brema'rantz abijau ziran.

* * *

Baña urira eldu baño lenago gaba etoŕi yaken.

Baso-erdijan egozan, eta guztiz nekatuta auŕkitzen ziralako, bertan lotu erabagi eben, atsedenduten.

Astua ta txakuŕa arte-azpijan, bedaŕ-aŕtian etzun ziran. Katuba adaŕ batera igon zan. Eta oĺaŕak zugatz -puntarano egaiz-egin eban.

Lotarako gertu ziranian, oĺaŕak ikusi eban, an uŕin, argi txiki bat. Eta lagunai esan eutsen.

—Etxeren bat ixango da, uŕian—astuak esan eban—. Uŕeratu gaĺezan bertara, ia estalperik topetan dogun, gaba igazteko.

—Eta bide-batez—txakuŕak esan eban—azuŕen bat idoroko dot, agiñai ezaŕteko.

* * *

Argija etoŕan etxerantz abijau ziran gure aberiok. Eta lasteŕ eldu ziran etxe baten ondora. Etxe onetako leyotik argi bixija uŕteten zan.

Astua, lau lagunetarik nagusija zan-eta, leyo-onduan jaŕi zan, ixiĺik eta iñok ikusi-barik. Orduban ikusi eban, baŕuko mai baten inguruban lapuŕ batzuk egozala janari ta edari gozuak aŕtuten. ¡Gixon arek egiĺen eben betekadea!

Astuak esan eutsen lagunai, ikusiĺa eukon gustija.

Orduban oĺaŕak esan eban:

—¡Maitik jausten diran ogi-apuŕak *sikiera-sikiera* ba'geunkoz be!...

—Agin gustijak galduta ezpa'neukoz—txakuŕak esan eban—iges-eragingo neutsen lapuŕ madarikatu oŕei, ta dan on aŕtian jango geunkez mai-ganian dagozan gauzak. ¿Baña agin-barik ze aŕayo egingo neuke?

Gustijetarik malmutzena zan katubak esan eban:

—Nik uste dot bide bat dagola gure gurarija betetako.

Eta lagunoi esan eutsen asmua, ta oneik ontzat aŕtu eben.

Asmuoi auŕera eruateko, asŕuak auŕeko anka bijak leyuan ezaŕi euzan. Txakuŕa asto-ganian jaŕi zan, katuba txakuŕenian eta oĺaŕa katu-ganian.

Ori eginda, danok batera abestuten asi ziran.

Astuak, iñoz ez egindako aŕausi andijak egin ebazan. Txakuŕak zaunka, katubak miau-miau ta oĺaŕak kukuŕuku zolijak jaurti euzan. Oŕegaz batera astua etxe-baŕura saŕtu zan, lagunok lepo-ganian eukozala ta leyoko leyaŕak (kristalak) apuŕturik. Gela-inguruban bira ta bira egin eban.

Lapuŕak ikaratu ziran eta uste ixan eben diabru berbera zala, inpernura eruateko eurok aŕapetan etoŕana. Oŕegatik, zalapartaka etxetik uŕten eta basora zuzendu ziran.

Gure aberiok, ori ikusi ebenian, mai-inguruban jezaŕi ta sekuleko betekadea egin eben. ¡Ene! ¡A zan tripakadea!

Sabela bete-bete ebenian argijak itxali ta lotara juan ziran.

Astua, lasto-ganian etzun zan. Txakuŕa, ate-auŕian. Katuba, sutonduan. Eta oĺaŕa, aurki (siĺa) baten gibelian. Nekatuta egozan-eta, andik lasteŕ lo-zoŕuan lotu ziran.

* * *

Gaberdijan, lapuŕak etxe-aldera biguŕtu ziran. Eta zaratarik ezeben entzuten-eta, uste ixan eben etxia utzik eguala.

Ori ikusteko, lapuŕ nagusijak lagun bat bidaldu eban etxera, zelan ete-eguan arakatuten.

Lapuŕa, ixil-ixiḻik, atzeko atetik saŕtu ta eskaratzera eldu zan. Aŕasta (pospolo) bat aŕtu ta sutondora zuzendu zan, katubaren begijak sukaldeko iḻetijak ziralakuan. Eta begi onekin piztu gura ixan eban pospolua.

Baña bat-batez, katubak atzapaŕka egin eutson, arpegi gustija odoletan ipiñita.

Lapuŕak, ikaratuta, diabrurik zalakuan, igesari emon eutson. Baña ate-ondotik igarotian, txakuŕagaz topo-egin eta jausi zan. Gure aberiok ezeban, oraṯiño, astirik galdu: zango-zanguan agiñak saŕtu eutsozan.

Bilḏuŕez beterik, beste alde batetik iges-egin gura ixan eban. Baña an astua eguan, ¿bai?, ta au, igaŕi -barik, zapaldu eban. Astuak orduban ostikada galanta bi bota eutsozan.

Gure lapuŕa luŕera jausi zan. Luŕera jaustian, oḻaŕa itxaŕtu ta kukuŕuku asi zan.

Lapuŕa jagi ta ariñeketan lagunakana juan zan. Onei esan eutsen:

—Ezin leike etxe oŕetara juan, bertan inpernuko diabru gustijak bixi diralako. Eskatzian sorgin batek aŕpegira txistuba bota ta atzapaŕka egin daust. Atian, txeŕen batek aginkada itxala egin daust ankan. Baŕuko gela baten gixon ikaragaŕijak zartada andija egin daust. Eta biṟaŕtian atso sorgiñak, didaŕez, esaten eban: «¡Ekaŕi egistazube lapuŕtzaŕ ori, neuk konponduko dot-eta!»

Lapuŕak, ipuin ori entzunda, etziran etxe atara ostera be juan. Eta andik lasteŕ ango luŕaldetik iges -egin eben.



Gure lau abeslarijok etxian lotu ziran. Eta bertako janari-edarijak amaťu ebezanian, lapuřen ogasuna topau eben. Eta onegaz nasai ta pozik bixi ixan ziran.

Ořegaťik etziran Brema'ra eldu. ¿Zetarako, bixiťeko baño geyagorako be esku-ařtian euken-eta?

Ořaťiño, baña, *Brema'ko abeslarijak* eristen eutsien, jazo yakenen bařì euki ebenak.





AKALDUN (eŕege) batek alaba edeŕa ta polita eukon. Baña neskatila au gustiz aŕua zan. Uŕeratuten yakozan mutil gustijai ezetsi ta alde-eragiten eutsen.

Bein atak erabagi eban jai aundija jauregijan egitia. Eta jai onetara detu eutsen, alabea emaztetzat aŕtu gura eben gustijoi.

Oneik mala batzutan jaŕi ziran. Lenen-lenen, bakaldunak. Gero, bakaldungeyak, dukiak, kondiak eta abaŕ, danak aldeŕezkan.

Gure bakaldunak alabeari dei-egin eta esan eutson, nai ebana senaŕtzat aŕtuteko. Baña neskatileak danoi begiratu ta danok ezetsi (despreziau) ebazan. Bat be ezeban gura senaŕtzat.

—¡Auxe da upea!—esan eban, lodi-lodija zan bakaldungei (printzipe) bat ikusita.—¡Au, baŕiz, ezpata-lakoxia!—esan eban, altua ta argala zan duke baten auŕian—. ¡Eta zeuk bustiñeŕe (ladrilo)-antza dozu!—margo (kolore) bixija eukon konde bati esan eutson.

Era edo modu oŕetara, danak ezetsi ebazan,

Baña okotz luzedun bakaldun baten lepotik baŕe-algarak egin euzan. Oni, iñori baño iŕi (burla) geyago egin eutson.

—¡Zeuria da arpegi motza!—baŕeka esan eutson—.

¡Okotza daukozu, beleak daukon moko (piku)-antzera!

Ordutik auŕera bakaldun oni *Belea* eristen eutsoen danok.

* * *

Neskatiĺaren aŕak, mutil gustijak ezesten ebazala jakin ebanian, agindu eban, jauregiko atian joko eban lenengo eskekuagaz ezkondu biaŕko zala.

Egun bi geruago, jauregiko atera, ogi-eske, eldu zan giŕaŕia joten eban eskale gixaxo bat.

Bakaldunak agindu eutsen moŕoyai, eskalia ta alabea bere auŕera ekaŕteko.

Eskekuak janzki uŕatubak eukozan. Eta eresi (soñu) bi jo ebazan, bakaldunak entzun egijazan.

—Jo dozuna atsegin ixan yat-eta—bakaldunak esan eutson—alabeagaz ezkonduko zaŕut.

Neskatiĺak negaŕari emon eutson. Baña alpeŕik: bakaldunak ezeutson jaramonik egin.

—Ludiko bakaldunik ospetsubenak ezesten zenduzala ikusiŕa — aŕak esan eutson —, ona elduko zan lenengo eskaliagaz ezkondu biaŕko zebala zin-egin neban. Eta ziña (juramentuba) bete-biaŕian nago.

Une atan bertan abadiari deŕu ta ezkontzea egin zan. Gerotxubago bakaldunak alabeari esan eutson:

—Emen eztaukozu oin zer-egiñik. Zure biaŕa da senaŕagaz bixiŕen juatia. Ondo ibiĺi, ba.

* * *

Eskekuak emaztia aŕtu ta eruan eban. Lengo neskatiĺea ta oraingo andrea, negaŕez ta miñez ba-zan be, senaŕaren atzetik juan zan.

Oyan luze batera elduta, bakaldunaren alabeak itandu eban:

—¿Oyan edeŕ au norena ixango ete-da?

—Bakaldun Belea'rena.

—¡Nire eŕukaŕija! ¿Zer dala-ta enintzan beragaz ezkonduko?

Ibiłi ta ibiłi, aran luze ta aundi batera eldu ziran.

—¿Norena ete-da gariz beterik dagon aran edeŕ au? —bakaldunaren alabeak itandu eban.

—Bakaldun Belea'rena.

—¡Nire eŕukaŕija! ¿Zer dala-ta enintzan beragaz ezkonduko?

Ibiłi ta ibiłi, guturira (guturi-ciudad) eldu ziran.

—¿Guturi edeŕ au norena ixango da?—bakaldunaren alabeak itandu eban.

—Bakaldun Belea'rena.

—¡Nire eŕukaŕija! ¿Zer dala-ta enintzan beragaz ezkonduko?

—Beti zagoz lelo oŕi ekiten—eskaliak esan eutson—. Kontuxu senaŕa nozula, ¿bai?, ta olako gauzarik entzutia etxatala atsegin Emetik auŕera eztautzut olakorik entzun gura, ba.

Azkenez, txabola zaŕ batera eldu ta eskekua gelditu zan.

—¿Nun ete-gagoz?—emaztiak itandu eutson.

—Gure etxian. Auxe dot nire gelea.

—Baña eztot moŕoirik ikusten...

—¿Moŕoirik diñozu? Bat be eztaukot. Orain aŕte neronek egiten nebazan etxeko zeregiñak. Baña emetik auŕera zeuk egingo daustazuz. Tira, suba piztu ta ura irakiten ipiñi, lapikokua egosi dadin, gose-gose naz-ta.

Baña bakaldunaren alabeak ezekijan olako zereginik. Bai, ba, bixitxa gustijan bordau batzuk baño ezebazan egin-eta... Eskaliak esan biaŕ ixan eutson gauza gustijak zelan egin. Oŕaŧiño, emaztiak ganorarik ezeukon-eta, senaŕak berak jatekua gertau biaŕ ixan eban. Gero, gustiz nekatuta, oera juan ziran.

* * *

Eguna zabaldu baxen lasteŕ, eskaliak emaztia iratzaŕtu eban, au, pozik, egun gustijan lotan egongo zan -aŕen. Iratzaŕtu ta esan eutson:

—¡Tira, agudo jagi ta etxia atondu egixu!

Orixe eginđa, suba piztuten eta jatekua ipinten irakatsi eutson.

* * *

Egunak juan egunak etoŕi, jateko eukon gustija amaŧuteko eguan. Orduban eskaliak emaztiari esan eutson:

—Alpeŕkerijan, orain-aŕte lez, ezingo dogu bixi. Zeu otzarak egingo dozuz, ¿bai?, ta ni aterik-ate ibiŧiko naz diru ta ogi-eske.

Esan eta egin. Senaŕak ekaŕi eutsozan gerotxubago, otzarak egiŧeko biaŕko ebazan zumelak. Baña lanian asiŧa, eskubetako naŕuba, naŕu me-mia, uŕatu yakon.

—Ikusten dodanez—senaŕak esan eutson—gogoŕegi yatzu lan au. Tira, ba. Oin iruten (gorubetan) asi biaŕko dozu, ogija irabazteko.

Eta goruba ta kalamuba ekaŕi eutsozan.

Emaztiak egiñalak egiŧen euzan iruteko (arija egiteko). Baña ezin. Ordu-lauren-baŕu, odolez beterik eukozan atzamaŕtxubak.

—Itxuraz—senaŕak esan eutson—eztakixu ezer egiŧen. ¡Ona egin dot nik, ¡bai bein!, zeugaz ezkondutia-

gaz! Baña itxon pizkat. Ixan leike, zeu salerosle eřimia ixatia. Bijartik auřera merkatura juango zara, erosiko dautzudazan gauzak salduten.

—¿Zer, baña?—emaztiak, kolkorako, esan eban—. ¡Neuk, bakaldun-alabeok, merkatuban saldu? ¿Danok ikusi ta lepotik bařerik egin dagisten? ¡Bai, zera!

Kolkuari esan, bai, baña senařari esaten etzan azař-tu, senařak lendik esanda eukolako, aginduten eban gustija egin-ezik, lepua berotuko eutsola.

Ořa, ba, bakaldun baten alabea merkatuban, pabuak salduten. Zorijonez, ezeban iñok ezagutu, atsekabiaren atsekabez arpegijak itxura motzagua eukolako.

Ořatiño, edeřa zan ondiño, ta beste andra saltzaľiak motz-motzak ziran-eta, danok begiratuten eutsoen.

Berialako baten saldu ebazan egazti gustijak. Eta bijotz oneko lagun askok, diruba emon eta egaztijok atzera isten eutsoezan, bařiro salduta diru geyago ařtu egijan.



Dan-dana salduta, irabazi eban dirubagaz egun askotarako euki eben. Gero bařiro lanari ekin biař. Eta ořetarako eřiko txaidietan (kalietan) jaři zan gure andrea, lapikuak, sartenak-eta salduten.

Bat-batez, gudari (soldau) bat, zaldi-ganian, eldu zan. Eta moskoř galanta eukon-eta. aberiagaz ontzi gustijak apuřtu eutsozan.

Bakaldunaren alabea, negař-zotiñez, senařagana biguřtu zan, jazo zanaren bači emoten.

—Zu ixan zara eřudun- gixonak esan eutson—, kale-erdijan jaři zaralako, bazteřtxu baten jaři-biařian. Baña, ¡tira!, negařari itxi, ¿bai?, ta salduteko be gauza

etzarala ikusiřa, bakaldunaren jauregira juan. Entzun dodanez, zeu-lako andra bat biař dabe eskaratzerako ta bixibide ori abindu dauste zuretzat. Lenengo egunetan jana ta edana bakařik irabaziko dozuz. Baña jateko ta edateko ugari emongo dautzube-ta, neugaz gomutau.

***

Esan eta egin. Eskaliaren andrea lanian asi zan jauregiko eskaratzian (esan-biařik eztago jauregi au etzala bere ařaren jauregija). Geřijan, lotuta, lapiko bi eruaten euzan, eta batetik kenduten ebana bestera botaten eban, senařak zer jan euki egijan.

Egunak juan egunak etoři, jai aundija ixan zan jauregijan. Bakaldunaren eguna ospatuteko.

Gure andrea, ikuskuraz, jaři zan areto (saloi)-ate -ostian. Toki au edeřto apainduta ta argiřuta eguan eta une atan uřez ta pitxiz jantziriko notiñez (lagunez) beterik auřkiřuten zan.

Andra kořadak atsekabez ekusan gusti a, ta gaiztesten eban bere ařokerija, itxura negařgaři atan ezaři eban ařokerija.

Alako baten, soñeko uřeztauta eukon. Bakalduna beragana eldu zan. Eta eskutik elduta areto-erdira, jantzarako, atara eban.

¡Baña gure andrearen bilduřa ta ikarea!

Bakaldun a etzan besterik, beronek iñoz destañez erabiliřako *Bakaldun Belea* baño.

Igesari emon gura ixan eutson. Baña Bakaldunak oratu eutson.

Alegin andijak egin ebazan iges-egiřeko, bertatik alde-egiřeko. Ořezkero, geřikua apuřtu ta lapiko bijok luřera jausi ziran. Euretarik batek, senařak jan biařko ebazan zukuba, okelea ta eltzarijak eukozan.

Esan-biařik eztago, lapikuok apuř-apuř egin eta jatekuak sakabanatu ziranik, orixe, esan-barik be, igaři leike-ta.

Ikusliak bałe-algaraka asi ziran.

Bakaldunaren alabea lotsaz gořituta eguan, an egon baño luř-pera sařtu gurago ebala.

Bakaldun Beleak, iři-bařez, esan eutson orduban:

—Bijotza nasatu ta ez beste negařik egin. Ziatz begiratu nagixu. ¿Eztozu igařten, ezkonduta zagozan eskalia ta neu notin (persona) berberak garala? Zure ařari entzun neutson, etxera elduko zan lenengo eskaliagaz ezkonduko zinduzala, ¿bai?, ta ořetarako eskekoz jantzi nintzan. Lenengo, guzuřezko bixařagaz ta gero azi yatanagaz, ainbeste bidař bałe-eragiten eutzun bela-okotza estaldu neban. Neu be ixan nintzan, gudariz jantzita, zaldijagaz lapikuok-eta apuřtu neutzuzana. Baña onezkero, ařokeririk eztozu-ta, lengo egitadakaz damututa zagoz-ta, eztozu beste atsekaberik ixango. Neuk auřkeztuko zařut biař diranen auřian, bakaldeři onetako Bakaldunaren emaztetzat, Bakaldun ori neu, Bakaldun Belea, naz-ta.

Gure andrearen ata be une atan agertu zan. Eta jazoten zanaren bafi emon eutsoenian, alabea laztandu eban.

Bijaramonian jai aundijak egin ziran jauregijan, jazokun gomutagařijoi ospatuteko.

¡Tamala, baña, zeu, irakuřle, ta bijok jai ořetara ezin juatia!





OYAN andi baten eguŕgiña bixi zan, emazte ta Jone eritxon iru urteko alabatxubagaz. Gure gixona lantzalia (langiĺia) zan gustiz, baña bein baño saŕijago zer jan ezeban eukiten.

Bein senaŕ-emaztiok ezer jan-barik geratu ziran, alabeak jan al-ixateko. Orduban eguŕgiña, aulduta (adoria galduta), aizkorea aŕtu ta zugatz tantai bat erasten abijau zan

Lanari ekiten asi zalarik, bat-baten, andra edeŕ bat agertu yakon, buruban ixaŕezko burestuna (koroya) eukona.

—Neu naz Ama Neskutza—gixonari esan eutson—, Josu Umiaren Ama, ta lendik nekijan, gustiz txirua (pobria) zarala, ta orixe dala-ta alabea ezin dozula azi. Zuaz bere biĺa, bere ama ixan gura dot-eta, nire ardura -pian beti eukiŕa.

Eguŕgiñak min aundija aŕtu biaŕ ixan eban alabea lagatzeko. Baña onen onerako zan-eta, Ama Neskutzaren eskubetan bijotzeko zatija itxi eban. Ama Neskutzak Jone aŕtu ta donokira (zerura) eruan eban.

An biaŕ eban gustija eukon. Esne gozua edaten eban, uŕezko janzkijak janzten ebazan eta inguruban

gotzontxubak (aingerutxubak) ibilten yakozan jolastuten (olgetan).

* * *

Amalau urte beteta, Ama Neskutzak dei-egin eta esan eutson:

—Ene alaba mańia. Bidezkunde (ibiltaldi) luzia egińen nua, ¿bai?, ta ořtik ziař nabıłan biłařterako Donokiko amairu giltzak emongo dautzudaz. Amabi gilz erabiłi daikezuz ezetariko ardura-barik, baña amairugařena, txikijena, ez iñoz erabiłi, zoritxařa ekařiko eutzun-eta.

Jone'k esan eban, Ama Neskutzaren aginduba ziatz beteko ebala. Eta Ama Neskutzak alde-eginda, bata bestiaren ostez, amabi gelaetako atiak zabaldu euzan. Txaki bakotxian Beldu (Apostolu) bat eguan, gixon eta emakume zorijondunez inguraturik.

Jone ta atzetik juaten yakozan aingerutxubak be pozik ebiltzan ikuskixun zoragařijok ikusiřa.

Ařezkero amabi gelak zabalik egozan. Itxiřa ezeguan besterik galazo eutsoen atia baño. Eta Jone urduri auřkiřuten zan, txaki atan zer egongo ete-zan jakin-guraz.

—Eneuke gura ate au gustiz zabaldu—gotzontxuboi esan eutsen—, pizkat baño, bařuban zer ete-dagon ikusteko beste.

—Ez—gotzonak erantzun eutsoen—orixe obena (pekatuba) ixango litzake-ta. Ama Neskutzak agindu dautzu. giltz oři bakian isteko. Eta aginduba beteten ezpa-dozu, zoritxařekua ixango zara betiko.

Jone'k ezeban ezer erantzun. Baña jakin-nayak zirikatuten eban, zirija sařtuten eutson.

Bein, gotzontxurik auŕian ezeguala-ta, atia zabalduteko gertau zan. Giltza aŕtu ta ate-zulora saŕtuta beriala, zabaldu zan ate au. Eta Jone zorabijau zan Irukoitz Deunagandik (Trinidade Santuagandik) edatuten ziran argi-izpijak ikusiŕa.

Eskuba begijetara eruan eban, Baña une atan argi disditsu aren izpijak atzamaŕ baten jo ta uŕeztau (uŕezko koloria emon) eban.

Bilđuŕez, atia itxi ta ariñeketan juan zan giltza jaboten (gordeten). Baña beti artega, beti urduri egoten zan. Eta ondo garbiŕu-aŕen, atzamaŕaren uŕe-margorik (kolorerik) etxakon kenduten.



Egunak juan egunak etoŕi, Ama Neskutza atzera etoŕi zan.

Neskatilari dei-egin eta giltzok eskatu eutsozan.

Jone'k emon eutsozanian, Ama Neskutzak iŕandu eutson:

—Amairugaŕen aterik etzenđuban zabalduko, ¿ezta?

—¡Ez!—Jone'k erantzun eutson.

Ama Neskutzak bijotz-ganian eskuba ezaŕi eutson. Eta taupadaka ebilala igaŕi ebanian, esan eutson:

—¿Egija ete-da gero aginđuba ziatz bete dozunik?

—¡Bai bein!—Jone'k, aŕokeriz, erantzun eutson.

Ama Neskutzak, orduban, neskatilaren eskubak aŕtu ta onek eskutau gura eban atzamaŕa ikusi eutson.

Ama Neskutzak lendik ekijan Jone'k ezebala bere aginđuba bete, baña beronen gurarija zan neskatilak autoŕtu egijala bere utza. Oŕetarako esan eutson:

—¿Jakin-gureak ez-ete-dautzu ziririk saŕtu, ta nire

aginduba ausita ez-ete-dozu amairugaŕen atia zabaldu?

—¡Ez, andria!—irugaŕenez erantzun eban.

Oŕezkero, Ama Neskutzak, begirada itxalagaz, esan eutson:

—Zeuk eztozu nire agindurik bete, ta ganera iru bidaŕ guzuŕa esan daustazu. Oŕegaitik etzara Donokijan egoteko duña.

* * *

Bat-baten Jone lozoŕuan lotu zan.

Itxaŕtu zanian, oyan (baso) aundi baten buruba ikusi eban.

Sorosi (sokoŕo)-eske didaŕ egin gura ixan eban, baña ezin, muturik eguan-eta.

Bilduŕ-ikarea saŕtuten eutson bakaŕtade atatik igesteko, ariñeketa baten asi zan. Baña alde gustijetatik sasi-esijak agertuten yakozan-eta, ezin alderik egin. Oyan-erdijan geratu biaŕ, ba.

Toki onetan zugatz tantai bat eguan, enboŕa utzik eukona. Enboŕ onetara saŕtu ta gelatzat aŕtu biaŕ ixan eban berau.

Enboŕ-baŕuban igazi (pasau) yakon orduko gaba, ta bertara saŕtu biaŕ ixaten eban, eurija ixaten zanetan, ateŕtuteko, ta axe andija ibilten zanetan, buruba zainduteko. Jateko ezeukon besterik sustrayak eta basoko igalijak (frutak) baño.

* * *

Udagoya eldu zan.

Orduban otu yakon oŕbela batu ta zugatz-enboŕera saŕtu, uŕengo neguban zegaz estaldu ta berotu eukiteko.

Aŕezkero, gustiz uŕatuta eukozan soñekuak. Gorpu-

tza estalduteko, oñetarañoko ule luziak baño besterik ezeukon.

Itxura negaŕgaŕi oŕetan bixi ixan zan urte askotxu, baña ezeban, oŕatiño, autoŕtu gura ixaten, Ama Neskutzaren agindubaren auŕka obenik egin ebanik.

* * *

Bein, udako azkenengo egunetan, luŕalde atako Bakalduna eizan (kazan) ebilan oyan atan. Eta alako baten, Bakaldunok il gura eban basauntzak, igeska, Jone'ren bixilekura jo eban. Bakaldunak atzetik jaŕatu eutson, baña sasi-esira elduta, ezin igaro. Orduban zaldiŕik jatsi ta ezpateaz sasijak ebagi ta bide-egin eban.

Orixe eginda, bedaŕ-ganian etzunda eguan neskatila (eguzkijaren argija baño edeŕagua zan neskatila) ikusi eban. Beronen uliak dis-dis egiten eban, uŕezkuak bai'litzazan.

Bakaldunak, apuŕ bat begiratu ta esan eutson:

—¿Zer dala-ta eldu zara toki onetara?

Baña neskatilak ezeutson ezer erantzun, len lez mutu egualako.

—¿Oyan au laga ta nire jauregira etoŕi gura ete -dozu?

Neskatilak, burubagaz, bayez erantzun eutson.

Bakaldunak orduban besuetan aŕtu, zaldi-ganian ezaŕi ta jauregira eruan eban. Emen agindu eban janzkirik edeŕenakin janzteko.

Gure neskatua edeŕ-edeŕa zan-eta, Bakaldunak erabagi eban beragaz ezkondutia.

Erabagi ta egin.

Urtebete igazita, seme bat sein-egin eban. Eta ga-

bian, bakaŕ-bakaŕik eguanian, Ama Neskutzak agertu ta esan eutson:

—¿Orain gurako ete-zenduban zure obena autoŕtu? Ori egiŕen ba-dozu, itz-egiŕeko almena emongotzut. Baña obenik autoŕtu gura ixan-ezik, semia eruango dautzut.

Jone'k, une baten itza loŕtuta, guzuŕari ekin eutson, esanaz:

—¡Ez, nik eneban zure aginđurik ausi!

* * *

Ama Neskutzak semia aŕtu ta alde-egin eban.

Oia utzik auŕkiŕu ebenian, jauregiko moŕoyak-eta moŕ-moŕka asi ziran, Bakaldunaren emaztiak berak semia il ebala esanaz.

Baña Bakaldunak emaztia zintzo maŕe eban-eta, ezeban olakorik ziñiztu gura.

* * *

Uŕengo urtian bigaŕen semia euki eban.

Gau atan Ama Neskutzak agertu ta esan eutson:

—Zure obena autoŕtu egixu. Ori egiŕen ba-dozu, itz-egiŕeko almena ta lenengo semia atzera emongo dautzudaz. Bestelan, jayopaŕi au be kenduko dautzut.

Jone'k ezetz eta ezetz.

Ama Neskutzak, orduban, bigaŕen umia kendu eutson.

* * *

Bijaramonian, jauregiko gustijak Eŕegiñaren auŕka (kontra) jagi ziran. Aginđarijak Bakaldunari eskatu

eutsoen emaztia ilteko. Baña Bakaldunak emaztia mate-mafierik eukon-eta, bere aurian olakorik ez esateko agindu eutsen.

* * *

Urengo urtian alaba edefa euki eben gure Bakaldunok.

Gau atan Ama Neskutzak agertu ta Eregiñari esan eutson:

—Nigaz etori.

Eta eskutik artuta, donokira eruan eban.

Bertan egozan bere umiak, ixarakin olgetan. Ama ikusita, laztanduten uferatu yakozan. Bakaldun-emaztiak, poz-pozik, mosu ta mosu egin eutsen.

—Atzera emongo dautzudaz umiok — Neskutzak esan eutson—zure obena esaten ba-dozu.

Baña Jone'k, temati, ezetz eta ezetz.

Orduban jauregiko gelan buruba ikusi eban. Baña alabarik ezeguan.

* * *

Onen bari jakin zanian, danok asaldatu ta Bakaldunari esan eutsoen emaztia ilteko.

Bakaldunak ezin eban ziñistu erijak esaten ebanik. Baña oneri ezetzik bariro ez-esatiaren, agindu eban emaztia epaikari-aurera eruateko. Andra onek ezin buruba garbitu, mutuba zalako.

Epaikarijak ilteko erabagi eben.

* * *

Gerotxubago egur-pilo baten ganian ezari eben. Eta su-garak inguratuten yakozanian, obenaren garbaya

igaři edo sentidu eban. Eta il baño lenago autořtu gura ixan eban.

Bat-batez itz-egiteko ala lořtu ta oyuka esan eban:

—¡Bai, Ama Neskutza, oben-egin neban!

Orixe esan eta eurija, uyolka, jausten asi zan, su-gařak itxungiteko (amatetako). Eta Ama Neskutza, argiz inguraturik, agertu zan Eskutik elduta, iru umiak ekazan.

Jone'ri emonaz esan eutson:

—Obena autořtu dozu-ta, azketsiřa (parkatuta) zagoz.

Au esanaz batera, ayenatu zan.

Bakaldun-emaztiak, orduban, egur-ganetik jatsi ta iru umiok Bakaldunari auřkeztu eutsozan.

Senař-emaztiak, andik auřera, zorijontsu bixi ixan ziran.





RAIN urte asko, Bakalduna ta Bakaldun-emaztia bixi ziran. Eta egunian-egunian alkaři esaten eutsoen:

—¡Ene bada-ta! ¡Umerik eukiko al-dogu!

Baña Jaungoikua'k ezeutsoen umerik bidalduten.

Bein, Bakaldun-emaztia bañua ařtuten egualarik, liořera ugarazijo batek eldu ta esan eutson:

—Urtebete igazi (pasau) baño lenago, zure gurarija bete al-ixango dozu, alaba bat eukiko dozu-ta.

* * *

Ugarazijuak esan ebana jazo zan.

Bakaldunaren emaztiak alaba edeřa ekaři eban, eta senařak, pozaren pozez, zer egin ezekijan.

Alabearen jayotza ospatuteko, jai andija gertau eban. Bertara elduteko, aide, adizkide ta ezagun gustijai, baťa mařagařijai (mařagaři-hada) be deťu eutsen, oneik, mařagařijok, alabearen alďez beti egon eřezan.

Bakaldeři atan amairu mařagaři egozan. Baña Bakaldunak amabi azpil (plater) uřezko bakařik eukozan -eta, euretarik batek jauregira juan-barik geratu biař ixan eban.

Bazkari andija ixan zan. Eta berau amaĺuta, maĺagaŕi bakotxak bezuza (eŕegalo) bat egin eutson neskatuari: batek ekanđuna (birtutia) emon eutson; beste batek, edeŕtasuna; irugaŕenak, ogasun andija... Oŕetara, ludijon (mundu onetan) ixan leikezan gauzarik onenak emon eutsoezan.

Amaikagaŕen maĺagaŕijak bezuzea emon eta bat -batez amairugaŕena eldu zan.

Au asaŕez eguan, bazkarirako deĺu ezeutsoelako. Eta iñori jaramonik egin-barik, esan eban:

—Bakaldunaren alabea, amabost urte betetian, ardatz bategaz zauriĺu ta iĺđa jausiko da.

Eta besterik esan-barik, alde-egin eban.

Entzuliak ikaratu ziran. Baña ondiño bezuzarik emon -barik eguan amabigaŕen maĺagaŕijak esan eban:

—Bakaldunaren alabea ezta ilgo. Eun urtetan lozoŕuan egongo da, ¿bai?, ta aldi ori igaziĺa, itxaŕtuko da.

Bakaldunak, alabeari zoritxaŕik jazo ezekijon, eŕiko ardatz gustijak eŕeteko agindu eban.

Gure neskatiĺak lortu ebazan maĺagaŕijak emondako gauza gustijak. Oŕetara, ba, gustiz edeŕa, begikua, zintzua ta zuŕa zan, eta ezautzen eben gustijok zintzoro maĺetan eben.

* * *

Amabost urte bete biaŕko ebazan eguna eldu zanian, gure gastia bakaŕ-bakaŕik eguan jauregijan, gurasuak atan (kanpuan) ebiltzan-eta.

Etxeko bazteŕ gustijetatik ibilten zan, dana ikusten Ibiĺi ta ibiĺi, goiko toŕera eldu zan. Zurubi estutik igon eta ate txiki batera jo eban.

Ateko zuluan giltza eguan. Oneri eragin eta atia zabaldu zan.

Baŕuban atsotxu bat eguan gorubetan, arija egiŕen.

—¡Egunon, andratxu! — neskatiĺak esan eutson—. ¿Zer ete-zagoz egiŕen?

— Gorubetan diñardut—atsuak erantzun eutson, buruba makuŕ-makuŕ egiñaz.

—¿Zer ete-da ain bizkoŕ darabiltzun gauza ori?— neskatuak iŕandu eban.

Eta ardatza aŕtu ta arija egiŕen asi gura ixan eban. Baña ardatza ukututa, atzamaŕa zauriŕu eban.

Une atan bertan lozoŕuan jaŕi zan. Eta lozoŕo au jauregi gustira edatu zan. Bakalduna ta emaztia (egin -egiñian be une atan etxera saŕtuten ziranak) lotan geratu ziran. Eta eurekin batera, jauregiko moŕoi ta andiki gustijak.

Kortako zaldijak be lotan geratu ziran. Baŕa baĺako (patioko) txakuŕak, teĺatuko usuak eta ormetako eulijak.

Eskaratzeko suba be lotan geratu zan. Eta egosten eguan lapikokua egosi-barik lotu zan.

Azkenez, eskatseñak eta sukaldeko beste moŕoyak be lozoŕuan geratu ziran.

Kanpoko axia geldiŕu ta zugatzetako oŕijak (jauregiko auŕian egozanak) ezeben beste zirkiñik egin.

Andik lasteŕ jauregi-inguruban sasijak eta bedaŕak azten asi ziran. Geruago andijago, etxe gustija eskutau eben.

* * *

Jazokun onen baŕi bakaldeŕi ta atzeŕi gustijan lasteŕ zabaldu zan. Eta gentia uŕundik etoŕten zan, jauregira

sařtuteko ustez, bedař ta sasi-ziař. Baña ezin, arantzak, eskubak bai'litzazan, elduten eutsielako. Eta batek baño geyagok bixitxa bertan galdu biař ixan eban.

* * *

Urtiak juan urtiak etoři, bakaldungei (príntzipe) bat bakaldeři atara juan zan. Eta gauza ikaragařija entzun eban: sasi ta bedař aren ařtian jauregi edeřa eguan. Eta jauregijan, lozořuan, eun urte aretan «Arantzadun lařosa» eritxoen bakaldun baten alaba edeřa auřkiřuten zan. Geyago ondiño: beragaz batera, ała ta ama ta etxeko gustijak lotan egozan.

Jazokun au edestuten eutson agureak esan eutson, ałiřari entzunda eukotsala gixon askok eldu gura ixan ebela jauregi onen bařura, baña sasi-ařtetik igaro-eziñik, bertan il biař ixan ebela.

Ori entzunda, bakaldungeyak esan eutson:

—Ni enaz ezeren bilduř, ¿bai?, ta nai-ta-ez «Arantzadun lařosa» ikusi biařko dot.

Olakorik ez egiřeko agureak esan eutson. Baña alpeřik.

* * *

Egin-egiñian be eun urtiok igaziła egozan. Eta «Arantzadun lařosak» itxařtu biařko eban eguna eldu zan.

Gure mutiłak sasira eldu ta lařosaz beterik auřkiřu eban. Sasijok, berez, alde batera egin eta bidia zabaldu eban.

Ukułu ta bałara eldu zan, eta zaldijak eta txakuřak lotan topau ebazan.

Tełatura begiratu ta usuak lotan ikusi euzan.

Bafura saftu ta eulijak, ormetan, lotan egozala uaftu eban.

Eskatseña sukaldian eguan, moroyai aginduteko moduban. Eta bertako neskamia olo bateri lumak kenduten.

Areto (saloi) andi baten etxekuak lotan egozan. Eta Bakalduna ta emaztia be bakaulkijan (tronuan) lo ziran.

Gustija eguan ixil-ixilik-eta, lotijen arnasea be entzun eikian.

Batetik bestera ibilita gero, torera eldu ta «Arantzadun larosa» lo eguan gelako atia zabaldu eban.

Begira-begira geratu yakon.

Edera zan-eta, ezin beragandik kendu begijak.

Gure mutilak makurtu ta ukutu eutson.

Bat-baten neskatila itxartu zan. Eta bakaldungeyari matekiro begiratu eutson.

Bijok alkaregaz batu ta bera jatsi ziran, Bakalduna, emaztia ta etxeko gustijai iratzartuteko.

Kortako zaldijak itxartu ta irintzika asi ziran. Etxeko txakurak jagi ta buztanari eragin eutsien. Eta telatuko usotxubak begijak zabaldu ebezanian, egal-azpitik buruba atara, alde gustijetara begiratu ta egaizka asi ziran.

Eulijak be ormatik gora ta bera ebiltzan arezkero; suba piztu ta lapikokua bariro egosten asi zan. Eskatseñak moroyari belarondokua emon eta neskamiak oluaren luma-kentziari ekin eutson.

Gerotxubago Bakaldungeya ta «Arantzadun larosa» alkarekin ezkondu ziran, luzaro ta zorijontsu bizireko.





IXON aberats baten emaztiak, il-zorijan, alaba bakařari dełu ta esan eutson:

—Ene alaba mařia: Jaungozale ta zintzua ixan, eta Jaungoikua'k lagunduko zau. Neuk donokiłik (zerutik) begiratu ta Jaunari zebařen (zeugařik) eskatuko dautsot.

Orixe esan eta il zan.

Neskatiła amaren iłobira egunero juaten zan, gustiz jaungozalia ta zintzua zalako.

***

Uřengo urtian gixon alarguna bigařenez ezkondu zan.

Emazte bařijak beste alaba bi etxera eruan ebazan.

Oneik mosu zuřija ta edeřa euken, baña bijotz gogořa.

Ordutik auřera ordu lařijak asi yakozan alaborde zorigaiztokuari.

***

—Eztogu gura neska zatař au geugaz ibiłi dałenik— aiztorde bijak esan eben—. Jango daun ogija irabazi egin biařko dau. Bua eskatzera, bada, neskamiari lagun -egiłen!

Bere jantzi edeŕak kendu, gona zaŕa jantzi-erazo ta oski (zapata) lodijak emon eutsoezan.

Orixe eginda, bere lepotik baŕe-egin eta eskatzera bidaldu eben.

*
* *

Goxetik gaberaño lanari sendo ekin biaŕ ixaten eutson.

Goiz-goxetik jagi, ura ekaŕi, jatekuak ipiñi, eŕopia garbiŕu ta josi biaŕ ixaten eban.

Aiztordiak alik eta kalterik geyen egiten eutsoen. Oŕez ganera, iŕi-baŕeka ta destañez erabilten eben.

Gabian biaŕari ekiñaren ekiñaz nekatuta egoten zanetan, ezin etzun, oerik ezeukolako. Gau gustijetan sukaldian lo egin biaŕ ixaten eban. Beti zikin eta itxura txaŕaz egoten zan-eta, *Zorigaiztokua* eristen eutsoen.

*
* *

Aŕak bein, azokara (merkatura) juan biaŕ ebala-ta, alabordiai iŕandu eutsen ia zer nai ete-eben.

—Janzki edeŕak—batak erantzun eutson.

—Pitxi poliŕak—esan eban bestiak.

—Eta zeuk, zorigaiztokuoŕek, ¿eztozu gura ezer?

—Bai, aŕa, niri ekaŕiko daustazu bidian topauko dozun lenengo adaŕa.

Gure gixonak azokara eldu ta alaborde bijoi janzki ta pitxi, poliŕak erosi eutsezan.

Etxerantz etoŕala *Zorigaiztokua*'ren aginduba gomutau eban. Oyan baten ondotik igaro zanian, adaŕ bat aŕtu eban.

Etxera elduta, alabordiai emon eutsen eurok eukatu eutsoena, baŕa *Zorigaiztokua*'ri be bere adaŕa.

Onek adara artu, amaren ilobira juan eta negarari emon eutson, ¡baña zelan negarari emon gero! Malkuakin bustita, adara azi ta zugatz edera bigurtu zan.

*Zorigaiztokua* egunian iru bidar juaten zan zugatza ikusten. Bere aurian belaunbikatu ta negar ta otoi egiten eban.

Alako baten ikusi eban, zugatz-adaretara txori zurija juaten zala, gura eban gustija emoten eutsona.



Eriko Bakaldunak jai andijak gertau ebazan iru egunerako.

Jai onetara bakalderiko neskatila gustijai dei-egin eutsen, euron artetik semiak emaztia artu egijan.

Jai ta dei onen bari alaborde bijok jakin ebenian, benetan poztu ziran. Eta *Zorigaiztokua*'ri deituta, esan eutsoen:

—Buruba oraztu ta zapatak garbitu biarko dauskuzuz, Bakaldunaren jauregiko jaira juango garalako.

*Zorigaiztokua'k* ori entzun eta negarari emon eutson. Berak pozik lagunduko ebazan aiztordiok.

Amordiari eskatu eutson alaba bijakin juaten isteko.

—Zu, *Zorigaiztoko,* loi-loi zagoz—amordiak erantzun eutson—. ¿Olako jayetara juan gurako ete-zenduban, jantzirik euki-barik? ¿Olako jayetan jantzarik egin gurako ete-zenduban zapatarik ez-ixanda?

Neskatilak ostera be eskatu eutson-eta, amordiak erantzun eban:

—Azpilbete (platerbete) tilista (lenteja) sutauts-artera

bota dautzut, ¿bai? Ordu bi baño lenago tiꞅista gustijak batuten ba-dozuz, geugaz etoꞅiko zara.

* * *

Neskatiꞅak baratzera jatsi ta didaꞅ-egin eban:

—¡Ene uso samuꞅak, zeruko txorijok: nigana erdu ta tiꞅistak batuten lagundu egistazube!

Orixe esan eta eskaratzeko leyotik uso zuri bi saꞅtu ziran, gero beste usakume bi ta, azkenez, eskaratz -inguruban egaizka asi ziran zeruko txori gustijak.

Usuak auts-aꞅtera mokubak (pikubak) saꞅtu ta *pi, pi* esaten eben. Beste txorijak be *pi*, *pi* egiꞅen asi ziran. Ordu-erdi-baꞅu lana amaꞅuta eguan.

Egaztijak, ori ikusiꞅa, egaizka, alde-egin eben.

* * *

Gure neskatiꞅak amordiari azpiꞅa eruan eutson, jaira juaten laketuko eutsola uste-ixanaz. Baña amordiak esan eutson:

—Dana alpeꞅik, ezingo dozu juan-eta. Janzkirik eztaukozu ta, ganera, jantzarik egiꞅen be eztakixu. Itxura oꞅetan ba'ziñoyaz, baꞅe-algarak egingo leukiez gure lepotik.

Gibelaz itxuli ta alaba bijakin juan zan.

* * *

Etxian iñor ezeguanian, zugatz-azpiko amaren ilobira juan zan *Zorigaiztokua*. Eta zugatzari esan eutson:

—¡Zugatz maꞅia:
emoistazu jauzkirik,
uꞅe-zidaꞅez
ta pitxiz beterik!

Orduban txori zurijak uŕezko jantzija ta zidaŕezko oskijak (zapatak) bota eutsozan.

Neskatiĺa gauza oŕeik jantzi ta jauregira juan zan.

Amorde-aiztordiak ikusi, bai, baña ezautu ez. Atzeŕiko printzesarik ixango zala pentsau eben. Euren eritxiz, gustiz edeŕto eguan uŕezko jantzijagaz. *Zorigaiztokua*'gaz gomutau bez, etxeko eskaratzian egongo zalakuan.

*Zorigaiztokua*'ren biĺa Bakaldunaren semia uŕten zan.

Eskutik eldu ta beragaz jantza egin eban. Eta ezeutson itxi iñogaz jantzarik egiten.

Neskatiĺari mutiĺik uŕeratuten ba-yakon, Bakaldunaren semiak esaten eutson:

—Ezin iñogaz jantzarik egin, neugaz baño.

Uŕengo goxeraŕte jantza egin eban. Eta bertatik alde-egin gura ixan ebanian, Bakaldungeyak esan eutson:

—Neuk lagunduko zatut.

Bakaldungeyak jakin gura eban, neskatiĺa a nor ete-zan. Baña onek, ezer esan-barik, usategira iges -egin eban.

Bakaldunaren semiak atari esan eutson, atzeŕitaŕ neskatiĺa usategira saŕtu zala.

Ori entzun eta usategira juan ziran jauregiko gixon batzuk. Baña ezeguan iñor baŕuban.

* * *

Aiztordiak etxera saŕtu ziranian, *Zorigaiztokua* eskatzian eguan, betiko janzki loyakin.

Gure neskatiĺak auxe egin eban: usategitik bizkoŕ

alde-egin eta amaren iłobira eldu, bertan janzkija erantziteko.

Txori zurijak au artu ta eskutau eban. *Zorigaiztokua*'k lengo janzki zara jantzi ta etxera zuzendu zan, amorde-aiztordiak eldu baño lenago.

Gau atan, etxekuak bigaren jaira juan ziranian, neskatilak zugatz-azpira eldu ta esan eutson:

—¡Zugatz matia:
emoistazu jauzkirik,
urez, zidarez
eta pitxiz beterik!

Txorijak ekari eutson atzeko egunekua baño janzki politagua.

* * *

Janzki aregaz jauregira sartu zanian, danok geldu (miraritu) ziran.

Bakaldungeyak, itxoten eguan-eta, eskutik eldu ta gau gustijan beragaz bakarik egin eban jantzea.

Neskatilari iñor ureratuten ba-yakon jantzarako atarateko asmoz, Bakaldungeyak esaten eutson:

—Onek eztau jantzarik egiten neugaz baño.

* * *

Goxaldian *Zorigaiztokua*'k alde-egin gura ixan eban. Baña Bakaldungeyak atzetik juaten yakon. Eta etxeko baratzera sartu ta eskutau zan.

Baratz onetan madari-ondo edera eguan, madari ederak dingilizka eukozana. *Zorigaiztokua,* katagorija bai'litzan, adaretatik gora igon zan. Eta Bakaldungeya abua zabalik geratu zan.

Baña jauregira atzera juan eta atari esan eutson:

—Atzeritar neskatilak orain be iges-egin daust. Madari-ondora igon dalakuan nago.

Bakaldunak agindu eban, aizkoraka zugatza erasteko. Baña alpeŕik: aŕezkero ezeguan *Zorigaiztoko*'rik.

* * *

Amorde-aiztordiak etxera eldu ziraneko, neskatiĺa eskatzian eguan, betiko moduban.

Oŕetarako auxe egin biaŕ ixan eban: madari-ondotik jatsi, amaren iĺobira juan eta janzki poliŕa txorijari emon. Gona zaŕa jantziŕa etxera zuzendu zan.

* * *

Irugaŕen gabian, etxekuak alde-eginda gero, *Zorigaiztokua*'k amaren iĺobira eldu ta zugatzari esan eutson:

—¡Zugatz maŕia:
emoistazu janzkirik,
uŕez, zidaŕez
eta pitxiz beterik!

Txorijak, orduban, atzeko egunekua baño askozaz poliŕagua zan beste bat ekaŕi eutson. Baŕa uŕezko zapatatxubak be.

Olan jantziŕa jauregijan agertu zanian, danak geratu ziran ikaratuta lez.

Bakaldungeyak gau gustijan beragaz egin eban jantzea. Eta iñor uŕeratuten ba-yakon neskatiĺari, jantza egiŕeko-edo, mutiĺak esaten eutson:

—Ez, ez, neugaz bakaŕik egin biaŕ dau-ta.

Uŕengo goxian *Zorigaiztokua*'k alde-egin gura ixan eban. Eta Bakaldungeyak esan eutson, berak lagun -egingo eutsola.

Baña neskatiĺak iges-egin eban-eta, ezin atzetik juan

Bakaldungeyak ordurako aginduta eukon zurubi (eskiĺera) gustija uyaz (ui-pez) igurtziŕeko. Orixe zala -ta, bertan iratziŕa lotu zan neskatiĺaren zapatatxu bat.

Bakaldungeyak berau artu ta txikija, polita ta urezkua zala ikusi eban.

* * *

Egun atan *Zorigaiztokua*'ren atagana juan eta gure Bakaldungeyak esan eutson:

—Emaztetzat artuko dot, zapatatxu au ondo daukon zure alabea.

Aizta bijak gustiz poztu ziran, oin txikijak eukezalako.

Nagusijak zapatatxuba artu ta sartu gura ixan eban. Baña ezin.

Orduban amak, aiztua luzatu ta esan eutson:

—Ebagi biatzak. Bakaldun-emaztia ixan zatezanian, eztozu oñez ibili biar ixango.

Neskatilak biatzak ebagi, oña sartu, zaurijak egiten eutsoen miñari jaramonik egin-barik, eta Bakaldungeyagana zuzendu zan.

Onek zaldi batera igon-erazo ta beragaz eruan eban.

Baña jauregira elduteko, *Zorigaiztokua*'ren amaren ilobi-ondotik igaro biar. Eta ilobi onetako zugatzian egozan uso bijok mutilari esan eutsoen:

—Ez juan aurera,
Bakaldungei matagarija.
Orek daukon zapata
ezta beria.
Benetako emaztegeya.
etxian dozu, begira.

Orixe entzunda, Bakaldungeyak neskatilaren oñetara begiratu ta odolez beterik ikusi euzan.

Zaldijari atzera eragin eta etxera eruan eban. Zapataren jabia a etzala amari esan eutson.

Orduban bigaren aizteak esan eban, berak probauko ebala zapata.

Onek saŕtu gura, bai, baña ezin, saŕtu orpua lodijegi eukolako.

Amak, ori ikusiťa, aiztua luzatu ta agind̄u eutson:

—Orpo-zati bat ebagixu, Bakaldunaren emaztia ixan zaťezanian eztozu oñez ibiĺi biaŕko-ta.

Neskatiĺak orpo-zatija ebagi, oña zapatan saŕtu ta onek egiťen eutson miñari jaramonik egin-barik, Bakaldungeyagana juan zan.

Bakaldungeya zaldi-ganian ezaŕi ta beragaz juan zan.

Zugatz-ondotik igaro ziranian, bertako uso bijok esan eutsoen:

—Ez juan auŕera,<br>
Bakaldungei maťagaŕija.<br>
Oŕek daukon zapata,<br>
ezta beria.<br>
Benetako emaztegeya<br>
etxian dozu, begira.

Gure mutiĺak, ori entzunaz, geldiťu, neskiaren oñetara begiratu ta odolez beterik ikusi ebazan.

Zaldijari atzera eragind̄a, neskatiĺa etxera eruan eban.

* * *

—Au be ezta nik biaŕ nebana—amari esan eutson—. ¿Beste alabarik eztaukozu?

—Ez—senaŕak erantzun eutson—. Lenengo emaztiagaz beste neskatiĺa bat be euki neban, *Zorigaiztokua* eristen dautsoguna. Baña ezin leike ori ixan zeuk biĺatuten dozun emaztegeya.

Bakaldungeyak esan eban, neskatiĺa ori be ezautu gurako ebala. Baña amak erantzun eutson:

—Ez, ez. Loi-loi dago-ta, ezin iñoren auŕian aŕkeztu.

Bakaldungeyak bayetz eta bayetz esan eban-eta, *Zorigaiztokua*'ri dei-egin biaŕ.

* * *

Arpegija ta eskubak ondo garbiŕuta gero, Bakaldungeyaren auŕian auŕkeztu zan.

Onek oskija emon eutson, ia ondo ete-eukon ikusi egijan.

Zuzulu baten jezaŕi ta uŕezko zapata jantzi eban sekulako edeŕtoen.

Zutunik jaŕiŕa neskatiĺaren arpegija ikusi ebanian, igaŕi eban axe zala iru gabetan beragaz jantza-egin eban neskatiĺa edeŕa. Eta danen auŕian esan eban:

—¡Auxe da, benetan, idoroten (topetan) neban emaztegeya!

* * *

Amorde ta aiztordiak, amuŕuz, zurbildu ziran. Baña Bakaldungeyak *Zorigaiztokua* aŕtu ta, zaldiz, eruan eban.

Zugatz-auŕetik igaro ziranian, uso zurijak esan eutsoen.

—¡Auŕera, Bakaldungei maŕia,
ta ez geldiŕu bidian!
Saŕtuteko uŕezko oskija,
Topau dozu biaŕ zeban oña.

Auxe esanda, zugatzetatik jatsi ta *Zorigaiztokua*'ren sorbaldan jaŕi ziran, bata eskumaldian, eskeŕian bestia.

* * *

Ezkontza-egunian, aiztorde ziŕalak koipekeri andijak egiŕen eutsoezan gure neskatiĺari.

Senaŕgei-emaztegeyak txadonera (elexara) zuzenduten zirala, aiztorde nagusija eskumara ta txikija es-

keřetara joyazan. Eta *Zorigaiztokua*'k lepuan eroyazan usuak, aiztorde nagusijari eskumako begija ta txiki jari eskeřekua kendu eutsien, begibakař itxita.

Txadonetik uřtetian, aiztorde nagusija eskeřaldian eta gastia eskumaldian jaři ziran. Eta usuak neska bakotxari beste begija atara eutsien.

Ořetara, bixitz gustirako zigořa ařtu eben.



1929'gko Otsala'ko 5'an
**Verdes-Atxirika'ren etxian**
amaitu zan idazti au

**4 LAURLEKO.**